Jexuxmari Zalakain Garaikoetxea  2007ko azaroaren 30ean espetxeratu zuten 8 urteko zigorra betetzeko. Urte horietan, tarteka, Dueñas (Palentzia, Espainia) espetxearen barrenetatik egindako bidaiaren kronikak argitaratuko zituen Herria 2000 Eliza aldizkarian. 12 kronika guztira. Gainera kartzelaldian idatzitako beste hiru testu jaso ditugu: elkarrizketa bat, argitaratu gabeko artikuluxka bat eta Ataramiñe'14 urtekarian egindako hitzaurrea. Guztira 15 idatzi labur, beraz, 8 urteko ibilbidearen norabidea azaltzeko. "Kezkatuta noa", dio despedidan. 2015eko irailaren 27an irten zen espetxetik. Gu ere kezka horrekin bizi gara, Jexuxmariren kartzela, gure kartzela delako. Kartzelan bizitzea zer den.

Titulua: *Kartzelako kronikak*
Egilea: Jexuxmari Zalakain Garaikoetxea. Euskal Preso Politikoa. Dueñas, 2007-2015
Kartzelako kronikak: Herria 2000 Eliza aldizkaria
Epilogoa:
- Elkarrizketa: "Soy un preso político con todas las consecuencias". Utopia 80. zbk. 2011, abendua
- Cambiarse cambiando
- Ataramiñe'14 Hitzaurrea
Azaleko irudia: Mikel Zarrabe
Egilearen argazkia: Herria 2000 Eliza
Egilearen biografia: https://eu.wikipedia.org/wiki/Jexuxmari_Zalakain
ePub edizioa: 2016, otsaila
epublibre.org webguneko ePub base r1.2 plantilaren gainean egina





EUSKAL ERREPRESALITAU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK

literaturakoadernoak.org

**Espetxean egon zaren bitartean *Kartzelako kronikak* izeneko artikulu sorta argitaratu duzu *Herria 2000 Eliza* aldizkarian. Zein asmorekin egin duzu?**

Aldizkarirako zerbait idazteko eskatu zidaten, eta, jakina, nik zuzendari lanak hainbat urtez egin ondoren eta denei eskatzen ibili ondoren, ez neukan irtenbiderik, onartu beharra neukan. Baina ez nengoen politikaz edo kanpoko kontuez idazteko moduan, eta, beraz, barruko esperientziez idaztea pentsatu nuen. Gehiegi ere ez nuen idatzi nahi, eta urtean pare bat kronika idaztea pentsatu nuen. Kartzelako bizimodu harrigarri hori islatu nahi nuen. Azkenean, hamabi kronika idatzi ditut, eta asko poztu ninduen hamabigarrena azkena izateak.

Jexux Mari Zalakain. 18/98 sumarioko preso ohia. «Auzian geundenak laster ohartu ginen kartzelarako bidean gindoazela» [Berria, 2015.10.03]

# Kartzelako kronikak -I-

Herria 2000 Eliza 215. zk. 2008
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-Eliza/aldizkariak/215/at_download/file

**Irakurle hori, agur t'erdi**

Inoizko aspaldian idatzi zuen Joxe Azurmendik (ez naiz ongi oroitzen Anaitasuna zaharrean ote zen edo Zerukoa zen garaiko Argian edo Jakinen) norberak bere izen propioaz sinatu behar duela, eta ez goitizen baten atzean ezkutatuta, eta bazela ordua biluzik agertzeko jendartean (sinbolikoki, jakina). Bada, biluz nadin zure aurrean, irakurle. Ez naiz berria H 2000 E.ko orriotan, baina azken boladan Mosen Etxepare ezizenez mozorrotuta ibili banaiz (eta lehenago beste batzuez) Jexuxmari Zalakain naiz, onerako eta txarrerako. Une honetan, bizitzaren errotarriak harrapatuta, preso nago Gaztelako lurretan, mundutik aparte, deserrian. Beraz, agur!

Desmundu honen berri eman nahi nizuke, interesatuko zaizulakoan edo. Hormigoi eta burdinazko itxitura honetan bizi den beterano batek esan dit ezen desberdin pentsatzen dela urte-pare bat barruan emanda edo hamalau osatu ondoren. Berak hogeitaka egin ditu dagoeneko, eta badaki zertaz ari den; nik, aldiz, zortzi hilabete egin berri ditut. Erabat neofitoa naiz, beraz; eta ondorioz, hurrengo lerrook hasiberri baten gogoetak dituzu, ez bahiketa luzea pairatu duen batenak, baizik eskarmentu eskasa dudan honenak. Nire begietatik eta bizipenetik azalduko dizut dagokidana, beste pretentsiorik gabe.

**Udako koloreak**

Uztailaren erdialdean harilkatu ditut hitzok. Uda sartu da lurralde honetan. Ez du bero patsa egiten oraindik; Santio egunaren bueltan gogorragoa izango omen da. Argitasunak nauka harrituta, gure etxean ez dagoena egun soltetan izan ezik: argi dirdaitsua eta zeru urdina. Ene leihotik, ezkerrera zuzenduta, soroak daude, eta mendixka-lerroak ixten dit ortzimuga. Ez nuke bereizten jakingo garia, garagarra, oloa edo zekalea den soroetan erein eta hazita dagoena. Kolorea dut begien bistan, eta gauetan, usaina iristen da, ogi usaina. Ez ditut biziki maite landa horiztatuak. Atseginago nituen udaberriko kolore berdeak, berdearen tonuak oro: berde hezea, berde iluna, berde urdinkara, berde zilar tankerakoa. Berdea, sorterriaren kolorea. Begiztatzen dudan horiak ere baditu tonuak: lastoarena, urre berri eta zahartuarena, espartzuaren gisakoa, argiak hodeien artean iragazita uzten duen horizta, itzalpean ala argi-galdatan ageri dena. Edozein modutan, leihoko sei burdinek mugatzen dute nire begiratua, ikuskera marratua de nirea. Sudurra aterata, besterik ezin baita, Euskal Herria iragartzen dut ipar-ekialdera muino baten tontorrean tente dagoen dorretxo baten gainetik harago, han nonbait.

Uzta, dagoeneko, segaren zain dago (makinatzarren zain, kasu honetan), eta mitxoletak desagertu dira bazterretatik.

**Galdu eta irabazi**

Libre eta nire erara mugitzeko askatasuna galdu dut, nire jendea ikusi eta besarkatzeko aukera eta Euskal Herriaren bizitza zuzenean, bertatik bertara partekatzeko pribilegioa. Inor nitaz ez kezkatzeko lasaitasuna neukan kanpoan; orain, aldiz, ezagutzen nauten guztiak nitaz arduratuta egotea irabazi dut, harrigarriki, lagunak zeintzuk diren bereizteko beta ere bai. Isiltasuna irabazi dut, nire buruari aurrez aurre eta errukirik gabe erreparatzeko denbora. Gustukoak ditudan gauzak irakurtzeko patxada, inori kontuak eman gabe, nire ibilbide propioa egiteko tarte luze samarra, bai, neurea. Hala ere, ni ez naiz hemengoa. Ez, ez naiz, baina nire baitakoa naizenez, barrualdea begiratzeko parada dut berriro ere –baldintza ez oso erosoetan, ados, egia osoa esan behar baldin badut-. Kartzelaldi hau, edozein delarik, zigorra bezainbat aukera eta opari izan dadin saiatuko naiz; horretan daukat erronka.

**Zaila da jabetzea**

Preso naukate, ez daukat zalantzarik. Sinets iezadazu, ordea, irakurle, oraindik ez naizela erabat jabetu. Kalean harrapatu eta lau poliziren artean ekarri ninduten Soto del Realeraino, gauez, Gordoniz kaleko komisarian arratsalde osoa pasatu ondoren. Buzo txuriz jantzi ninduten, nire arropa kenduta; etxekoak –emaztea eta alaba- ate ondoan neuzkanean “kundan” eraman ninduten Valdemorora, kaiola batean sartuta, haien angustiaz zamaturik, eta ziega estu batean atxilotu ninduten beste bi kiderekin. Hilabete baten buruan, beste “kunda” batean Dueñasera ekarri ninduten urte berri egunean. Modu ederra urteari hasiera emateko! Badakit zer den medikuarenean eskuak loturik egotea guardia zibilen aurrean osasunari dagozkion konfidentziak egin ezinik. Ezagutzen ditut ziegako giltzarrapoen soinu herdoilduak, labezomorroen gaueko bisita nazkagarria, ezusteko katxeoen trantzea eta zalaparta, zaindarien komentario laidogarrien tonu iraingarria (ANetik eskuak loturik ateratzean, G.Z. batek lurrean jarri zidan sententziaren artxibadore lodia, esanaz: “utzi, utzi, jasoko du berak, hauek Athletik-ekoak dira eta”), kartzelero baten jarrera mespretxagarria (kartzela-aldaketa iragarri zutenean, gitarra jotzen hasi zen leihatilaren aurrean). Badakit zer den asteburua txabolotik irten gabe egotea, kide baten amaginarrebaren heriotza salatzeagatik. Ikusi dut desmundu honen soslaia. Aitzitik, badakit zer den kolektiboko kideen samurtasun ordainezina ere.

Ordea, hara, euskal presoen historia ezagututa, urteetako nekaldietatik onik eta burua tente atera direnetako batzuk aldamenean ikusita, ez naiz haiek bezain preso sentitzen, kalean egiten diren elkarretaratze eta prentsaurreko adoretsuak irakurrita, beste norbaitentzat direla begitantzen zait, ez niretzat. Izan ere, ez bainaute jo, umiliatu, zanpatu. Ez nago bakartuta, isolatuta, etengabe xaxatua. Ez didate euskaraz hitz egitea debekatu, nire familiako emazteak biluztu. Ez dut gose-grebarik egin behar izan oinarrizko eskubideak defendatzeagatik; ez naute gauez ankerkeriaz erasotu, paperak nahastu. Ez naute heriotzara behartu. Ez didate kondena luzatu irteteko egun berberean. Garbi daukadana da haiei esker daukagula, daukagunok, gaur egungo patxada, eta arruntek erakusten diguten errespetua. Preso nago, bai, preso; ziegako atea ixten didaten bakoitzean, mekanismo automatikoaren hotz urruna antzematen dudanean asaldura sumatzen dut erraietan, halako larrialdi sinesgaitza kiribiltzen zait hesteetan… hilobiko zuloa harritzarrez estaliko balute bezala.

Bakardadean eta bakardaderako hezi ninduten, ohituta nago. Nik, ordea, ez dut bakarrik bizi nahi. Urteetan

izan dut maitale bakardadea; George Moustaki greko-frantziarrak zioen hura kantatu dut sarri askotan (“non, je ne suis jamais seul avec ma solitude”), ondo jakin gabe zer nioen. Orain, alabaina, izaren artean bildu zait bakardadea, baimenik eskatu gabe.

**Odol tanta bat asfaltoan**

Munduko kondenatuen alde jarri naiz beti, modu nahiko naturalean. Ustez, haien aldeko apustua egin genuen gaztetan. Orain ez dut apustu egin beharrik. Haiekin bizi naiz, haiek bezalatsu. Haien ordutegi berberaren arabera mugitu behar dut, otordu berberak irentsi, ordu berberean jaiki eta erretiratu, erregimen berbera pairatu. Halakoxea da gure patua.

Moduluan sartu ahala, herioa aurpegian marraztuta zuen presoa ikusi nuen (Heriok eraman du jadanik). Inork eskatu gabe paketeak igo zizkidan berbereak agurtu ninduen. Inork molestatuz gero bere ukabilen babesa eskaini zidan kantabro batek. Gutxika-gutxika gainerakoak “ezagutu” ditut: poliziak berak ezagutzen ez duen izenez bizi den mairua, Euskal Herrian petrolera bat jartzeko asmoa agertu zidan beltza, gure aberria nik baino hagitzez hobeto ezagutzen duen palestinarra: labankadaz jo eta urlia hiltzeagatik dagoena; deabruarekin hitz egiten duen eta eulitzar amorragarri baten antzera uxatzen saiatzen den afrikarra. Gimnasioan gorputza zizelkatzen dutenak, euskal abizenak eduki arren sustraiak non dituzten ez dakitenak, epailea bere alde jartzeko obsesioaz bizirauten duena; bortxatzaileak, mafiosoak, drogak menderatutako hainbeste, etab., etab. Kartzelaldia norberak bere erara bizi du, ahalen eta zirkunstantzien arabera, lasai edo erreboltatuta. Bat baino gehiago kapaz da teilatutik eroritako txolarrea urez eta ogi-papurrez elikatzeko eta, aldi berean, zigarro-pakete batengatik beste preso bati burua bi zati egiteko, mahai baten hanka aitzur modura erabiliz. Zorrak odolez ordaintzen dira hemen, irainak labankadaz; ez dago errukirik, biziraupena tartean egonda edo ohorea auzitan. Merkea da odola zulo honetan. Nik neuk ere ikusi dut neurea isurtzen, ezustean kolpe txar bat buruan hartuta. Neurea, ordea, ez da ezeren ordainetan isuri, pauso baldar baten ondorio izan da. Dueñaseko patioan nire odol-tanta geratu da, asfaltoa gorrituz, nire urratsen lekuko.

# Kartzelako kronikak -II-

Herria 2000 Eliza 218. zk. 2009
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/218/at_download/file

**Kaixo irakurle, agur t'erdi**

Urtarrilean zehar ekin diot kronika hau idazteari gure berri izan dezazun, nire begietatik. Ez ahaztu nire gogoetak direla. Edozein modutan, bizirik gaude eta pozik; hori ziurta dezaket.

Hirurogeita bat urte kendu dizkiot dagoeneko bizitzari eta bat, jada, kartzelaldiari. Nire arima tormentatua soseguan da, berriro antzeman diot nire izarraren arrastoari eta haren uharan abiatu naiz. Ditudan mugak gobernatzen ikasi (ote) dut… Bizitza osoa eskas izan ohi da norberak bere burua egoki samar ezagutzeko. Aitzitik, grinaz nago, sasoi betean, behingoz. Ez, ordea, zalantzarik gabe. Sumatzen dudan beldurrak ez du zerikusirik etorkizunarekin, labain egin eta hezurren bat kraskatzearekin baizik; hara zer diren gauzak.

Azken boladan zuhur erreparatzen diot zoruari; ia-ia hanka-puntetan nabil behegaina noiz joko, patioko leian ez ezik, galeriako xaboi-uretan edo era guztietako zikinkeriatan laprast egin, ertzen batean kolpatu eta kaskoa zartatzeko ikaraz. Hipokondria ote den pentsatzen jarri naiz, baina zerbait egiazkoagorik badago funtsean. Izan ere, minduta daukat gerrialdea, ahul sentitzen ditut belaunak, esnatu egiten nau aldakako min sorrak, bizkarrezurraren okerdurak ez du toki egokirik hartzen ohantze dudan belaki ziztrinean, eskuineko hankak ez du gorputza tente mantendu nahi eta, ondorioz, eskudelari oratuta igo behar ditut eskailerak maiz.

Tematia naiz eta eutsiko diot. Hau ez da kexatzeko tokia, ezpada gogortzekoa. Nola etsi, gainera, kide bat daukadanean beti alai eta bipil asko, lurrean soinketan ari zela, ehun kiloko mozolo bat gainean jausi, bizkarra hautsi eta hilabetetan oinazez lo egin ezinik ibili dena? Huraxe dut orain aholkulari eta trebatzaile.

**Negu gorrian**

Negua hotz doa, udazken euritsu eta ospelaren ondotik. Iaz ez bezala, aurten, hiru bat aldiz ikusi dugu elurra. Gau osoan iraun du geruza zuri aratzak patioan. Jaikita, berehala lardaskatu dugu: batzuek jolasteko grina bihurriagatik, beste batzuek, zapaltzean, elur birrindua oinazpian zapart egiten sentitzeagatik (pra, pra, pra). Inguruko soroetan elurra urtu denean, dena da basa, apenas bilotxo berdea, han-hemenka, loraldiaren aiduru.

Laino artean bizi gara aspaldion. Udaberria, ostera, mehatxuka dator guretzat, etorkizuna erabakiko baitigute esperantzagarri izan ohi den urtaroaren atarian. Etxeko lanak txukun egin dituen mutikoaren antzera begitantzen zait epaia. Lerro hauek irakurtzean, ebatzi badute auzia, jakizu, adiskide, ez nauela

noraezean harrapatu(ko), motxila eta aldartea prest baitauzkat, basamortuan barrena zeharraldia egiteko. Ez dit loa galaraziko, maite ditudanen negarra izan ezean.

**Txoria bere kaiolan**

Maite al dezake txoriak bere kaiola? Hara zertan pausatzen zaion bere gogoa burdinen artean hesiturik bizi den preso honi; are gehiago, Laboa txori kantari ezagunena joan zaigunean ortzimugaz bestaldera, galderak oihartzun bihurtzen dituen alde hartara… Maite al dezakeen, beraz txoriak, ez dakit. Herriaren iruditeria epikoak, kantuaren sinbologia askatzaileak ezetz dio, ezin duela. Baina presoak bai, ahal du. Zer egin behar du, beraz, preso honek hainbat ordu bakarrik egon ondoren, besteekin batera galeriara jaitsi eta kea, hatsa, zarata, jendetza oihuka, leku-eskasia baino topatzen ez badu? Zer, estualdiren batek eraginda, komunera joan behar duenean eta, aldiz, ipurmasailak non kokatu jakin ezinik dabilenean, katilua ez ezik ingurua ere kerruz hornituta ikusirik, jariakin eta soberakin organikoz eta inorganikoz josita, beretik obratzea ezindurik (barkatu errealismo talegeroa), txaboloarekin amestea baino?

Ez pentsa txaboloa suit inperiala denik (5 x 2 metro luze-zabala da). Halaber, inork inbaditzen ez dizun bitartean, zeure intimitatea bortxatuz, norberak atondutako santutegi laikoa da, poza eragiten dizun aurpegi eta paisaiez apainduriko aldaretxoa, ate automatikoa, haizezko berogailuaren bafadak gorabehera. Hamaika arrazoi daude zeure ziegan ezkutatzeko, zeure baitara biltzeko begiluzerik gabe, literatura-orrietan murgildu edota historian zehar nabigatzeko, zeure erara aritzeko. Badakizu han ere ez zaudela seguru, katxeoren baten biktima izan zaitezkeelako. Halakoren bat gertatzen denean, badakizu: lasai, txo, okerragorik izan duk eta. Eta pentsatzen jartzen zara zer nolakoa izango ote den amorruaren tamaina, dena lurrean sakabanatuta edo gorrotoz txikituta topatzean… Ez dut horrelakorik ezagutu… oraingoz. Horixe du kartzelak, jazarrita edo xaxatuta sentitu ezarren, arrotz egiten zaizula giroa kalekume ez bazara edo trapitxeoa ez bada zure erreferentzia naturala. Kideak daude, jakina…

Lotsaz aitortzen dut orain arte ongi nagoela, eta lasai, politikoki okerra zenentz. Isolamenduan bakartuta daukaten kide batek, sakabanaketaren opariz urrundurik, “paradisuan nago” esanez idatzi didanetik, ni ere paradisu txikian bizi naiz. Irakaslea beti irakasle, preso arrunt bati espainolez irakurtzen eta idazten irakatsiz nabil: “la–le–li–lo-lu; Lola le lee a Lali la ele”, eta kide baten euskarazko testuak gorriz zuzentzen… Otzantzen hasia ote? Autodefentsa, tovaritx!

**“Non dira ene lagunak…”**

Antzinako abesti hori belarrian paratuta ekin nion Gabon-gauari, izaretan kukututa. Etxamendi eta Larralde izan ditut ohekide urte zaharrean, herriminez malkotxo batzuk isuriz oharkabean. Jende asko dabil hemen gora eta behera, hara eta hona, ipurterre madarikatu. Ez da erraza lagunak egitea; agian komenigarria ere ez, kideen eremutik at.

Zergatik ez dakizula, ordea, batzuk itsatsi egiten zaizkizu, eta hunkitu ere bai, baten balentriak entzunda, besteren sufrikarioaz jabetuta. Zenbat istorio gaitz! Halako bat isolamendura eraman dute, oldarraldiaren ondorioz; eta kasurik onenean, askatasunera norbait… Hala, atera dute **E**. ate bat ostikoka hartu zuelako, urduri. Joan da **H**., ustez betiko; urtetako eme-gosea kitatu ezinik ibiliko da, larrutan, apaldu guran;

zereginik preziatuena horixe zuela esaka atera zen behintzat. Abiatu da **F**. E.H.ra, gure jendearekin maiteminduta, baina esku bat aurrean eta bestea atzean, zortearen peskizan. Eta beste hainbat; adibidez, **J**. Afrika beltzera, deabruari kontuak eskatzera. Asko, luzaro gabe, itzuliko dira, errotarriak gupida gabe zanpatuta. Gutxi batzuek iskin egingo diote adur malapartatuari.

Oroz gain, Igor Ortega kide hondarribiarra joan zaigu eta berehala Amaia Arrieta neska-laguna eta bien alabatxo Ilargi, jarraian. Bejondeiela hirurei! Kide askatu berriaren irteerak hutsunea uzten dio barruan geratzen denari, erauzitako haginaren tamainakoa; mihiarekin bilatzen duzu zuloan ordura arte lekua betetzen zuena. Inoiz guri ere egokituko zaigu ateratzea, ezer ez baita betiko. Agian beste norbaitek arakatuko du bere oien artean, nire bila.

Norbaitek erro-errotik idoki du patioko txokorik ospelenean, komunen kontra, porlanak utzitako arrakalan gora zetorren zuhaixka berdea. Ordea, konpentsazioz edo, bi trabesti sartu dituzte gure aldran; finezia-punttu bat ar bakartion unibertso maskulino itsusi honetan. Geroztik, irritsen bristadak piztu dira begiradetan, lizundu egin dira soarak. Bitxikeria, ordea, tragedia bihurtu da bietako baten mutilak bere buruaz beste egin duenean, siesta orduan urkatuta. Gertakariak estututa utzi digu bihotza, hitzak ezinean. Heriotza are hitsagoa da zulo honetan. Nik ziegan hildako kideak ditut gogoan, banan-banan.

**“Bihar eguzkia”**

Ez dirudi hori esan daitekeenik orain. Gauden gaudenean nekez igurika daiteke udaberria. Zakar jotzen du haizeak. Erauntsika dator ura eta oraindik estu hartuko omen gaitu neguak. Gauetan ez da giro, korridoreetako estalkiak noiz eroriko. Ahulegia dirudi kartzelako egiturak astinaldiei eusteko. Meteorologiaz harago, politikari dagokionez ere, botereen zafraldiak ez du etenik abertzaleen aurka. Gupidagabeki ari dira herrikideak paretik kentzen. Neurrigabeki hazten doa atxilotu eta presoen kopurua. Amama Emilia (De la Bodega) hil zaigu. Hala ere, “bihar eguzkia”. Gure patriarka Pabloren mezua da. Jakintsuak badaki.

# Kartzelako kronikak -III-

Herria 2000 Eliza 224. zk. 2010
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/224/at_download/file

**Kaixo, irakurle**

Bame-bidaiara abiatuta utzi zintudan aurrekoan, horretarako txartela erosita, gogoratu. Eta orain hemen nauzu orain artekoa kontatzeko asmoz. Aitortu behar dizut lotsa pixka bat ematen didala; zalantza dut ozarkeria ez ote den nirea, inork eskatu gabe ari bainaiz neure pausoak azaltzen; gutxienez narzisista ez naiz, hori ez, horretarako neure buruarekin maiteminduta egon beharko bainuke eta ez nago, ez nagoenez.

Nik idatzi, irakurle hori, noizean behin idazteko premia sentitzen dudalako idazten dut eta bide batez, agian, zuri ere interesgarri suertatuko zaizulako ezagutzea preso naukaten neronek nola pasatzen ditudan egunak eta gauak, nola jasaten ditudan penak eta doloreak, nola gainditzen ditudan, edo ez, bizitzaren atsekabeak eta ezustekoak, eta nola begitantzen zaidan etorkizuna.

Zuk ez duzu zertan jakin, baina ondo gogoan dut nola filosofia-ikasle nintzela -anartean 17-18 urteko gazte ameslari eta inozoa- orduko gure seminarioko arduradunak (padre prefekto-ak) esaten zidan, ezen helduaroan kultura orokorra irakasten ikusten ninduela, non eta Klaretarren Xixongo kolegioan. Bada, ez du bat ere asmatu orainik bizirik behar duen apaiz zumaiarrak; izan ere, hemen naukazu preso, askatasunik gabe eta jainkorik gabe, etorkizuna inoizko ilunen agertzen zaidala, ezagutu ditudan altzo guztiak zapuztuta: umetan amarena, gero ordenarena, jarraian erlijioarena eta oraintsu emaztearena. Zer besterik utzi behar ote dudan ez dakit behingoz libre eta neure buru sentitzeko…

Ni barrukoa naiz, euskal herri hezekoa. Agian horregatik orain artekoan seguru sentitu izan naiz, oinak lurrean, are harroinean, finkatuta lez; une honetan, aldiz, erabat itsastar begitantzen zait neure burua, azpiak kulunka gaiztoan, zola gabeko eremuan nola. Aitor dut abailduta nagoela, bihotzean hotz egiten duela, hotz mina eta, hala ere, banoa txalupa xume baten tostan, brau eta brau, esku banatan arraun astunari eraginez, brau eta brau. Itsaso zakarrean sartu naiz, zerua errukigaitz, Kalypso paregabearen besoetan gozo eta laxo urteak eman ondoren. Nora noan ez dakit, baina banoa, berriro bakarrik, Peneloperik gabeko irlara, agian Itakara, han nor aurkituko dudan, neure penak nola goxatuko, neure usteak nola mamituko, neure gurariak (artean zutik dirautenak, nire bizitzaren eraikinak oro aurritan utzita) nola bizitzen jarraituko dudan ez dakidala. Argi laru zurbila baino ez daukat begien parean, hainbeste aldiz nahastu nauen izarniadura berbera igartzen diot, itsasoa zerutzat eta gau urreztatua eguntzat hartzera makurtu nauen distira berbera. Eta, hara, orain ere, damurik ez, halako amets-aire bihurria dario nire aldarteari. Berriro liluratua izateko prest nengoke, oraindik oinazea sakonegia ez balitz. Nola bizi bestela, jakiterik baldin badago, sorginduta izan ezik.

**Liburuetan babestuta**

Metaforak baztertuta, liburuetan gordeta eta kideen ardurapean pasa dut erauntsiaren gogorrena, benetako lokamutsa. Hasieran, neure buruaren erroitzetatik libratzeko "El protocolo Sigma", "El pianista siciliano" eta "La mano de Fátima" irakurri ditut; gerora, ohartukiago, Marcel Prousten "Denbora galduaren bila" J.A.Arrietaren bertsioan; eta azkenik, bihotz egarberaz, Joxe Azurmendiren "Azken egunak Gandiagarekin", ezin ederragoa. Ez dut aukera pasatzen utzi nahi esan gabe, Joxeren aitortza biluzi eta zintzoa nire saminen sendagarri eta barru-altxagarri suertatu zaidala Dueñaseko leotzean. Zer ote daukate liburu batzuek irakurle aseezinari, beti, unean uneko premien araberako zerbait eskaintzeko? Zer esan nezake liburu bati buruz, bizitzen lagundu didala baino beteago, eskergaitzago? Bada, horixe: mila esker, Joxe, Bitoriano gomutan.

**Bizi guran**

Negu gorrian idazten dut. Hotz egiten du Gaztelan, hotz nire baitan. Sarri malkoak azaltzen zaizkit begietara, desorduko bisitari gogaikarri bailiran, baina, edozein modutan, ez da erosta jotzeko garaia. Udaberria ez da urruti izango eta, dakidala, E.H.ko eremu politikoan gertu dabil, engoitik sartua ez bada. Ni neuri istorioari zor natzaio eta, ahal dela, ez diot muzinik egingo, bilaketan, ibiltari zein itsastar, bide ezegonkorrari jarraitzeko. Gizartea aldatzeko nork bere burua aldatu behar duela irakurri berri dut nik maite ditudan orrietan eta nik ondorengo hau hobetsi arren, alegia, ez dagoela nork bere burua aldatzerik gizartea aldatzeko ahaleginean baizik, elkar ulertzen dugu eta garai berrietara egokitzeko gonbita jaso dut, bizimodu berri bat eta beti berrirako agintzari modura.

Kartzelako imajinarioan badago esaera bat askoren ahotan dabilena: "egun bat gutxiago" edo "egun bat gehiago", zeinak adierazten duen kartzelaldiari egun bat kendu zaiola askatasun aldera, edo bizitzari ebatsi zaiola, nondik begiratzen den. Sarri egon naiz esaera hori hausnartzen. Eta ez ditut gustuko. Ez niretzat. Izan ere, nola edo hala, gutxi asko, esan nahi baita egun hori ez duzula bizi, alferrik joan dela bere joanean. Nik ez dut kalera irten arte itxaron nahi bizitzen hasteko. Bizitzaren gorabeherek hona ekarri naute eta hemen eman behar ditut hainbat egun, errepikaezin direnak, hartu ala uztekoak erremediorik gabe. Hemen ez baditut bizi, galduak ditut. Eta ni egunak bizi guran bizi naiz…

# Kartzelako kronikak -IV-

Herria 2000 Eliza 227. zk. 2010
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/227/at_download/file

**Irakurle hori, agur t'erdi**

Pozgarria da jakitea batek idazten duena beste batzuek irakurri dutela; kezkagarria ere bai, aldiz, zerbait ondo transmititu ez duzula ohartzea. Hala, bada, entzun dut irakurle batzuk asaldatu egin direla nire azken Kronikarekin, eta iluna, hitsa iritzi diotela testu hari, itxaropenik gabea. Nire idazkera, berriz, zail samarra omen da, ulergaitza. Egia esan, gardentasuna ez da nire dohainik behinena, eta "estiloa, gizakia" baldin bada, agian horrek ez dauka konponbide errazik. Zertxobait argitze aldera, esan dezadan ezagutzen nauen edonork dakiela halako tristura-hari mehea dariola nire izaerari, malenkoniak erraz hartzen nauela mendean, ez naizela bereziki baikorra. Ostera, begi-bistan dagoen nire jarrera positiboa, are erasokorra, neketan ikasia izan dela (kristau eta fraile zintzoen abaroan, pankartako urte loriatsuetan, adiskide ameslariekin, E.H.ko jende adoretsuen artean) eta horrexek lagundu dit bide berriak urratzen, oztopoak gainditzen, edo behintzat saihesten, patuari aurpegi ematen, etab. Beraz, nire azken Kronikan drama dago, neurea, baina baikortasunik ere badago, nire inguruari eta nire buruari zor diedana: argi laru dirdaitsuaren irudia, berriro zerbaitek edo norbaitek liluratua izateko jorana, etab. Oro har… nire gauzak!

Eta zer esan nire estiloari buruz? Bada, bai, agian arrazoia dute nire irakurle kezkatuek. Kontua da nire "obratxoa" osatzen nabilela kartzelaldia baliatuz eta, beraz, asko lantzen ditut nire testuak, hitzak zizelkatuz, hizkuntzaren itsaso zabalean ume-umetatik geureak beharko genituzkeen termino ezohiko batzuk neureganatuz. Nire Kronika hauek zerbait zabalagoaren, arnasa luzeagoko idazkiaren zati izan nahi dute eta, hara, helburu literarioa ere badute, barrutik jariatzen direnak forma ederrean bilduta eskaini nahi bainituzke, zulo honetan dastatutako bizipenak jaso eta era txukunean hedatzeko…

**Adiskide bat bazen…**

Alabaina, aitor dut, nire testuak badu hutsune nabarmenik, orain kitatzera noana. Izan ere, bere itzalean ez du ikusten uzten niretzat garrantzitsuena dena: nire adiskideak. Nola aipatu kartzela barruan adiskide solidarioek duten pisua! Nola eutsi, bestela, atsekabe honi, urruntze gupidagabe honi! Dagoeneko bati baino gehiagori esan diot, batere lotsarik gabe, lokutorioan: "nire arnasa zarete orain". Txintxo-txintxo astero 40 minutuko bisitara etortzen zaizkidanak ez ezik, era guztietako opariak egiten dizkidatenak. Izan ere, opariz bizi naiz "sensu stricto". Arropa, oinetakoak, liburuak, aldizkariak, CDak, postalak, eskutitzak, dirua, denetatik jaso ohi dut opariz. Malkotaraino hunkitzen nau tamainako eskuzabaltasunak. Astero bost gutun idatziz ez diet denei erantzuterik ahal. Hainbat igorle ez dut ezagutzen, baina argi asko erakusten didate presookiko duten atxikimendua. Eurak, adiskideak, dira gure osasunaren, trinkotasunaren eta ilusioen oinarri-zaintzaile, elkartasunak mugarik ez duen Euskal Herriaren adierazle. Noizko halako eraginkortasunari buruzko libururik? Begira batek idatzi didana: "Ezin dut bihotza apurtzen dizun oinazea

ebitatu, baina zurekin egin dezaket negar eta zure bizitza berregiten lagundu; ezin dut zure lehena eta geroa aldatu, baina zure ondoan izango naiz, behar banauzu; ez ditut zure erabakiak epaitzen, baina jaso ezazu nire babesa, eragina eta afektua".

**Ekarpena, pazientziaren ildoan**

Hiru urte egitera noa kartzela berberean, modulu berean, 5 metro karratuko ziega berean, 50 x 30 metroko patio berberari itzuliak kentzen, behin eta berriro zapatilak higatzen. Moduluko zaharrena naiz eta, ia-ia, beteranoena ere bai. Izan ere, sekulako giza trafikoa dago hemen; ziega batetik bestera, moduluen artean, kunden joan etorri etengabea, kaletik zulora, zulotik mundura eta, ondorioz, bizpahiru baino gehiago ez dira geratzen hona iritsi nintzenean egoiliar zeuden internoetatik. Jakizu hemen ez dagoela presorik. Hemen "interno" gara denok, eufemismo aringarrian esanda… Behin baino gehiagotan jarri naiz pentsatzen zer ezkutatzen ote den aldaketa sarri horien atzean. Frailetan ere gertatzen zen eta uste dut gauza bera dela: toki batean ohitu orduko aldaketa zetorren, erroak ez botatzeko, atseginik ez emateko, lasai bizitzen ez uzteko, oreka galtzeraino astinduz eta noraezean utziz. Hemen ere berdintsu…

Konturatu naiz egonarria, pazientzia alegia, dela hemen beharrezkoen zaidan bertutea, justu oso oparo ez dudana, ipurterre samarra izaki, dena azkar, eskutik eskura, nahi izaten baititut gauzak. Ohiz hala izan da, baina hori bukatu da niretzat, esatea burutzea baino hagitzez errazagoa den arren. Pazientzia, urteak txukun bizitzeko eta hemendik sano ateratzeko, orduen mantsotasun taigabean alferkerian ez itotzeko, geroaren geroari itxaron gabe jarduteko, oroimenaren oinazeei jaramon handirik ez egiteko, nire aiurriaren ostikoei galga jartzeko, kartzela-sistema itogarriaren bulkadetan tinko eusteko, bakardadearen sare likatsuan itsatsirik ez geratzeko, behar denean -orain, adibidez!- konfiantzaz egoteko. Niri neuri dagokidanez, behinola "pazientzia iraultzailea" zeritzana zer den dastatzen ari naiz, Casaldaligak esango zukeenaren arabera, "inpazientzia pazientean".

Itxura denez, ordea, egonarria, pazientzia alegia, ez da soilik guri, presooi, dagokigun bertutea. Kalean ere franko beharko da "ziklo berrian" irudikatutako helburuak erdietsi nahi badira. Pazientzia, pertzaka!; zer gerta ere, bide zuzenean gabiltzala sentitzeko, arerioari eta geure grinei amore ez emateko, amarruak dotoreziaz eta erabakimenez gainditzeko edo, behintzat, saihesteko.

Nago, ez ote garen pixka bat apokaliptiko. Ni, seguru baietz!. Apokaliptiko, ez Umberto Ecoren adieran, kristautasunean (eta hari lotutako kulturan) loratutako joeraren arabera, baizik. Jesusi, eta bere lehen jarraitzaileei gertatu zitzaien, uste baitzuten mundu berria, mundu zaharraren iraungipena, atearen beste aldean zeudela, bota besterik ez zegoela. Eta ez da horrela izan, bistan denez. Kristautasuna, mundu honetan beste modura bizitzea da, beste balore batzuk sustatuz… Lekutan!

Euskal Herriaren independentzia (sozialismoa zer esanik ere ez!) ez da belaunaldi bat edo biren kontua, egin den ahalegin erraldoiari erreparatuz nik hala sinetsi arren. Lanak jarriko du oinarria, eta "ezusteak" gainerakoa. Noizko? Auskalo! Agian horixe da unearen ederra, ez dakigula noiz mamituko den… Edozein moduz, nik nire txikian, betiko galdera pausatzen diot neure buruari, orain ere bai: zer egin dezaket probetxuzko Euskal Herriarentzat?; zein ekarpen gelditzen zaizkidan urteetarako? Gaztea ez naizen arren, beti daukat presente Amurizaren kartzelako bertsoen errepika hura: "Kartzelan erneko da Euskadi

berria…”

**Mugituko da!**

Goiko lerroak idatzita nituela, bi aipu irakurri ditut gure prentsan: “Pazientzia garratza da, haren emaitzak gozoak”, dio A. Otegik; “Pazientzia eta ausardia beharko ditugu”, Erakundeak. Beraz, ez gabiltza hain desbideratuta.

Azken boladan asko urritu da hemen preso gaudenon kopurua, jendea kaleratu ordez, harat-honat mugituz: Herrerara, Darocara, Valladolidera, Martutenera. Moduluetan 4-5 kide egotetik, gehienez bi egotera behartu gaituzte; binaka gauzkate, ia beste inorekin harremanak edukitzea eragotzita. Senideak bidegabeki miatzen jarraitzen dute, elkarrekin etortzea debekatuz, kontrolak zorroztuz…

Beraz, txarra kenduta, dena ongi! Ez daude menian. Badakigu. Baina hori ere mugituko da, “Elkoro libre” taldeak irudikatutako elefantea bezala…

Elkororen presentzia gozoa galdu dugu, besteak beste, baina bere etxetik gertuago dago, Martutenen, zor zaion askatasun-eskean, kalean noiz jarriko duten zain…

Uda igarota, udazken-neguan sartu gara, hazia erein, usteldu eta hozitzeko prest ipintzeko garaian. Udazken-negu sendoa agindu digute dakitenek, gure gogoaren berogarri. “Nihil novum sub sole” esaka dabiltza batzuk, baina guk ia-ia aztoraturik hartzen ditugu agiri mardulak, elkarrizketa mamitsuak, gogoeta borobilak, ekimen suharrak…; larriminez, hainbat gazteri egindako tortura garrasiak; ezinean, torturatzaileen inpunitatea; lotsaz, intelektualen eta kazetarien isiltasuna. Garai batean Lluis Llach-en “estaca” jausi zen bezala, elefantea ere mugituko da…

# Kartzelako kronikak -V-

---

Herria 2000 Eliza 233. zk. 2011
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/espetxe-suntsitzailea/at_download/file

---

**Irakurle hori, agur t'erdi**

Ongi egongo naizela baina badaezpada, nola nagoen galdetu dit adiskideak. "Gaizki ez" edo "ondo esan beharko" erantzun nahi nuke edo, behintzat, horixe aterako litzaidake naturalen, gure arbaso nekazarien antzera. Ironia gehiagorekin "Txarra kenduta dena ongi" esan liteke baita ere, hemen, ondo, ondo ezinezkoa baita inondik ere. Non ez dakit, baina irakurri dut guk presook beti "ondo" esaten dugula, gure egoeraz galdezka datozkigunean, maite ditugunak ez kezkatzeko. Halaxe izango da, segur aski. Nik, nire bizitzaren une honetan, nahiago dut "bizitzen ikasten" esan, horixe begitantzen baitzait adierazpide zuzenena niri dagokidanez. Batzuetan esan ohi den kontrara, kartzelaldiak ez du zertan "denbora galdua" izan. Bizitzen ari gara hemengoak izan ez arren. Patuak, edo zuzenago, gure konpromisoak eta epaileen erabaki bortitzak hona bideratu gintuztenetik hemen jokatzen dugu gure bizimodua, bihotza, begirada eta asmoa hemendik urrun egonda ere.

Bizitzen ikasten jarrita, beraz, zerbait ikasi dut dagoeneko: bat, "pankarta garaian" nire ahalmen ia mugagabeak antzeman nituen bezalaxe, hemen, ziegan, bakardadeari hertsiki atxikita, nire hauskortasuna ezagutu dut; sakonean ni ere hauskorra naizela dastatu ahal izan dut, nirekiko besteekiko baino dexente gehiago; nire buruarekin pittin bat barkabera izaten ikasten ari naiz, kostata; ezin dudanean, "let it be" esaten hasi naiz, mantso-mantso, bizitzari eta gertakariei emeki-emeki izaten uzten. Zer diren gauzak, batzuetan gizakiok egoerarik aldrebesenetan ulertzen ditugu gauzak! Gogoan dut UPVn doktorego-tesia prestatzen ari nintzela, irakasle adiskide batek "pentsamendu dialektikoari" buruzko ikastaro bat eman zigula. Ni orduan ez nengoen erretolika haietarako prestatuta, arrotz samarra iruditzen zitzaidan hura dena. Baina orain ederki ulertzen ari naiz sakonean zer zegoen irakasle hark pasioz azaltzen zuen gai niretzat gogaikarri haren atzean; batik-bat politikari dagokionez eta bizitzari dagokionez ere bai, ezin dela zurrunegia izan, fase bakoitzak bere ezaugarriak dituela eta, ondorioz, bere berariazko eginkizunak. Adibide erraz bat ipiniko dut: pentsamendu dialektikorik gabe ezinezkoa zatekeen ezker abertzalearen "transatlantikoa" espazio estu batean biraraztea; eginkizun horretan aritu direnak zurrunak, linealak eta printzipistak izan balira, ezin izango zen gaurko egoera mamitu. Printzipistak ez badira moldagarriak, sendotasunari malgutasuna ez bazaio eransten, akabo, goiz edo berandu, zapart egingo dute, guztion kalterako. Guri bihotz-aratzak izaten irakatsi ziguten eta, zinez, probetxuzkoa da bihotz-aratza izatea, baina antzu izan gabe…

**Gauza asko gertatu direla eta…**

Gauza asko gertatu dira nire azken kronika bidali nuenetik, kanpoan batez ere, barruan gauzak bere hartan jarraitzen baitute, oro har. Barrukoetatik hasiz, ordea, esan dezadan inoiz baino isolatuago gaudela,

normalean kide bakar bat ikusiz eta, beraz, gure arteko edozein eztabaida edo iruzkin partekatze hutsa ezinezko bihurtutik. Dueñasen bertan kideongandik bakartuta daukate Haritz zarauztarra, inor bakarrik utziko ez zuten hitza janda. Neska guztiak ere aspaldi atera zituzten, den-denak urrunduz. Edozein moduz, ni gauza batek kezkatzen nau bereziki, kide gaixoen egoerak. Itolarriz irakurri dugu lehen baino gaixo larri gehiago dagoela kolektiboan eta, egia esan, horrek benetan asaldatzen nau. Kalean gaixorik egoteak ez baitu zerikusirik zulo honetan gaixo egotearekin. Galdetu Ibon Iparragirreri… leku-aldaketak, kundak, baldintza kaskarrak, janari eskasak eta askatasun-falta bera huskeria dira kartzelan larriki gaixo egotearekin konparatuta.

Azken boladan "iraupen luzeko" hainbat kide atera dira (Gatza, Elurtxuri, Errandonea …) eta lagun batek zera idatzi dit Gaztela Mantxako zulo batetik: "poza ematen dik jendea kaleratzen ikusteak eta hainbeste denbora egon ondoren, patxadatsu eta zutik ateratzen direla ikusteak". Egia da, egia denez; izan ere, pirrikoa da gure etsaien garaipena. Baina niri beste honek ematen dit amorrua, alegia, ia denak "konplituta" ateratzeak, euren kondena bururaino ordainduta, koska eta guzti kasu askotan; baina horrek senideen eta herri oso baten borroka erraldoiaren tamaina erakusten du, etsi gabe jarraitu beharko dena. Ea gutxienez ahalik eta lasterren irabazten den "biziarteko doktrinari" buruzko ahalegina. Nire baitan uste dut horrelaxe aterako garela ia denak, konplituta; edozein moduz, ez baztertu borroka etsigabeak ematen dituen ezusteko gozoak.

Inoiz azaldu dizuedanez, "arruntez" edo "sozialez" inguratuta bizi gara: bina politiko ia 140 presoren artean modulu bakoitzean. Euskaldunok "modulu gatazkatsuetan" gauzkatenez, kontu egin zer-nolako giroa egongo den gure bizi-eremu murritzean. Ez dut hitz egokirik topatu nire hiztegi pertsonalean guk, politikook, dugun abantaila goraipatzeko: bisitak astero, eskutitzak sarri, telefonoz nori deitu erruz, geure gauzatxoak erosteko dirua txartelean… eta den-dena maitasunez eta elkartasunezko jarreraren ondorioz. Gogoa zabaltzen du, lokutorioko kristalaren atzetik baizik ez bada ere, astero norbait zu ikustera etortzeak, bere hitz goxoak ezpainetan, arnasa indarberrituz; baina aldi berean, nik ezin ditut tristura-tanta batzuk ekidin, nire bizilagun "arruntak" bisitarik gabe gelditzen direla ikustean. Txepela eta belaxka izango naiz, baina nik nekez daramat "munduko kondenatuen" zama… are gehiago haien ondoan bizi naizelarik.

Kanpoan ere gauza anitz gertatu dira: Afrika iparraldeko herriak matxinatu egin dira (jendea betiko ezin dela zanpatu erakutsiz), edozein tokitan jende haserretua sistemaren kontra jarri da (bazen garaia!), Fukushimako zentral nuklearrak lehertu egin dira (energia nuklearraren seguritatea defentsarik gabe utziz tokirik seguruenean, Japonian, hain zuzen), Bin Laden garbitu dute (giza eskubide ukiezinak pikutara bidaliz), etab. Hala ere, guri dagokigunez, Sortu/Bildu fenomenoa izan da aipagarriena, eta bozkarioz zein arretaz jarraitu beharko dugu, erretxinik gabe, jendeari protagonismoa utziz. Gure herrian aldaketa sakonak egosten ari ziren bitartean, Joseba Sarrionaindiaren azken liburua irakurtzen ari nintzen ni (Moroak gara behelaino artean?). Lerrokada batzuk aldatu nahi ditut hemen, harrigarriak eta korronte nagusiaren bestaldera begiratzen dutelako, estatuaren leloa baztertzen baitute: "Euskaldunen eginbeharra da estaturik gabeko halako nazio bat, bi estatuon artean, gainsortzea. Halako konstituzio bat izkiriatu beharko genuke. Estaturik gabeko nazio librearen konstituzioa. Lehenengo konstituzioa izango litzateke, gizon zuriaren zamarik gabe, askatasuna, igualitatea eta elkartasuna proklamatzen praktikan. Eta karga dezatela estatuotako gizon zuriek biolentziaren zama lepo gainean; karga dezatela biolentziaren

monopolio lotsagarri horrekin. Ez poliziarik, ez legerik, ez armadarik, ez kartzelarik. Ez mugarik: beste nazionalitateei ongietorria egingo zaie Etxean eta euskaldun bakoitza doan lekuraino ailegatuko da pasaporterik gabeko euskal herritartasun unibertsal hori”.

Uste dut liburu honetan biluzten duela Josebak ondoen bere pentsamendu soziopolitikoa, fikzioaren geruzak estali gabe. Liburuaren atal miresgarriena Afrika iparraldeko amazig herria agerira ekartzeko saioa da. Kurduak bezala, gu geu bezala, hainbat estatutan hedatuta, arabiarrek bezatutako herri ahaztua, konkistatzaileek izen ezkutatzailea eman ziotenetik, berbereak, hots, barbaroak ez balira bezala bizi da. Hemen, nire alboan, bat baino gehiago daude. Hala ere, zanpatuak izan baino lehen, sekulako matxinada burutu zuten espainiarren eta frantziarren aurka.

Zer gara gu, nor gara gu? Josebaren iritziz: “Ez gara moroak, Euskaldunak ere ez. Ezer ez garelako erabaki dezakegu zer nahi dugun izan, eta zer nahi dugun egin”. Horixe bera!: erabaki.

Eta horrela doa mundua bere akats eta bertuteekin; zuek ekinean, gu ahaleginean; zuek tiraka, gu eusten; zuek ate-joka, gu zain. Irakurri dugu Espainiako eta Frantziako kartzela-agintariek ez dietela Gernikako Akordiokoei guregana heltzen utzi nahi; zertara datoz orduan agintari horiek guri Agiri hori sina dezagun galdezka? Pena bat dut, bai: proiektu honetan parte hartzerik ez izatea. Oraingoan guri ikusle/entzule izatea egokitu zaigu. Eta nire proiektu akademikoei buruz zer esan? Coitus interruptus, kalamidadea. Bitartean, beraz, bizitzen ikasten; nire kasuan, hizkuntzak ikasten eta praktikatzen eta oroz gain itzulpenaren gozoa dastatzen…

San Inazio bezperan idazten dizut; beraz, uztak bilduta daudenean. Udazken oparoa izan. Ez adiorik.

# Kartzelako kronikak -VI-

Herria 2000 Eliza 237. zk. 2012
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/inmigrazioa/at_download/file

**Irakurle hori, agur t'erdi**

Lerro hauek udaberrian edo udan ezagutuko dute argia, baina laino-artean idatzita daude, behe-laino egunak baitira hauek Dueñasen. La Moralejako lainoartean, sarri, kontrol-dorrea bera ez da nabarmentzen. Alabaina egon badago, badagoenez, bere eragina lekuko. Gaztelako gau hotz oskarbietan izarrak ageri dira gain-gainean, nola ez dakizula eguneko laino-artean itzuri eginda, euren presentzia etengabearen aitorle distiratsu. Urrun dago artizarra, egunean ezkutatu arren, ilunean ikusgarri. Lainoartean zabiltzanean, ostera, ezin antzeman batere leinururik gabe igarri daitezkeen argiune laru horiek benetako argi-iturriak diren ala beste edozeren isla, agian zure zerorren nahiera eta gutiziena. Erabat ilun egin arte ez daukazu frogatzerik haren jatorria. Egunak joan, egunak etorri, hortxe dirau artizarrak inon baino hobeki heltzean, ñir-ñirka.

Nire txaboloa ekialdera zabalik dago, burdinek zarratzen duten arren. Altxatu orduko badakit eguzkia sortu eta bere ibilbidea egiten ari dela; maiz, ordea, ez dut ikusten, ilunabarrean haren arrastoa, malba eta arrosa, antzeman arte.

Gutaz hitz egiten dute hedabideek, erruz: badela ateratzeko garaia, iritsi dela gutxienez EHra etortzeko unea; barkamena eskatu behar dugula, damutu eta ordaindu; prest daudela kartzela berriak gure kolektiboa hartzeko; banan-banan sartu beharko dugula sarobean, burua makur, gogoa deuseztatuta. Ari direla, ba omen dabiltza; eskubiderik ez dagoela, neurriz kanpo luzatzen ari direla agonia hau; oraingoan bai, prestatzeko, zain gauzkatela familiak eta lanpostuak; azken sosa ordaindu arte ez dagoela zer eginik… eta hola bakoitza berean… Lagun eta adiskideei poza eta ilusioa darizkie eta guri, sarri, ardo gozoari ur geza botatzen ari ote garen zapore txarra geratzen zaigu, lokutoriotik bueltan, antsietateari aurre egiteko, autodefentsa-mekanismoak gehiegi sakatzen ari ote garen, uzkurregi azalduz edo.

Nik gure gaixoengan daukat begirada pausatuta, espetxealdia bete arren urtealdi erantsia egiten ari direnengan, 3/4ak aise gaindituta dauzkatenengan, batzuk nire ondo-ondoan daudelarik. Bitartean nire kondenaren egutegia mehetzen ari da, txarren-txarrenean denbora nire alde dagoela jakinik. Gure askatasuna erdietsi nahirik gau ta egun lanean ari diren gizon eta emakume nekaezinak dauzkat gogoan, euren ahalegina ezin dela alferrikakoa izan errepikatu eta mantra taigabean tematuz. Nolanahi ere den ez gaude abandonatuta, ez gara mundutik aparte bizi.

Burua eta muinak garaipenean dauzkanak ez daki, ordea, hura noiz, nola eta norentzat iritsiko den. Gauza hauetan eskarmentu minimoa daukanak, berriz, badaki, jakin, askotan garaipena ez duela borrokalariak berak ezagutzen edo, modu kontsolagarrian esateko, borrokari muzin egiten ez dion bitartean berea dela

garaipena, hori izanik bere ondare bakarra.

Jainkoa aurkitu duen norbait da orain gure zaintzaileburu bat; nagusiena, ez dakit. Eguneroko meza entzun, errosarioa aletu, otoitzaldia eta irakurketa espirituala egiten dituen horietakoa. Ai, ama! Hauen eta enparauen askatasun-katea honakoxea da: damua-barkamena-aitortza-zigorra (eta ez sinboliko hutsa apaizek ezarritako penitentzia gisara, egiazkoa baizik). Larrutik ikasita daukat aseezinak direla, eta men eginez gero, jai duzula!

"Zamorako apaiz-kartzela" liburu gomendagarria amaitu berri dut. Behin hartuta ezin izan dut bukatu arte utzi. Ez gara gu borroka honetan hasitako lehenak. Badira gu baino lehenagokoak, gu (orain) baino askoz okerrago bizi izan direnak, miseria gorrian, zakur ostikatuak lez. Zirrara egin dit orriotan hainbeste lagun topatzeak, nik bezala sotana jantzi zutenak, nik baino arrisku dezente gehiago hartu zutenak eta zigorrari espanturik gabe eutsi ziotenak. Gure pankartaldian maiz bisitatzen gintuzten haietako batzuek; batek sarri idazten dit oraindik eta gainera liburua oparitu dit eskaintza eta guzti, bere ohiko xalotasunez. Mila esker, Martin!

Inoiz baino denbora (eta gogo) gehiago daukadanez prentsa irakurri, albisteak aztertu eta gogoetak egiteko (baita lo egiteko ere; agian horregatik egongo naiz erne), hara hemen ale batzuk. Fraga hil da -bere zoritxarrerako Iribarne ere bazena-; zein hitz aipatu dute gehien?: "Patriota". "Patriotismoa ez da zaharkin bat" (Martin Ferran dixit). Hara, hara… ez gabiltza hain gaizki euskaldun abertzaleok, kontrakoa entzunaren entzunez irizten hasiak baikinen abertzaletasuna (patriotismoa) XIX. mendeko hondar lohia zela… Aurrera bolie.

Espainiako Hezkuntza ministro berriak bere errezeta "berria" aurkeztu du prentsaurrean: elebitasuna ("ez soilik ingelesa irakatsiz, ingelesez irakatsiz baizik"). Hori ez al zen gure inmertsio linguistiko deabruzkoa?. Primeran goaz. Garzón zigortu dutenean hauxe azpimarratu dute betikoek: "egia ezin da edozein bitarteko erabiliz erdietsi". Bingo oraingoan. Tortura bidez ere ez, alegia. Eta amaitzeko, Gerri Adamsen gomendioa: "helburua lortzeko, gogoa, erabakia, estrategia egokia eta pazientzia behar da", "ez da nahikoa xedearen zuzentasuna". O.K, my friend.

Musulman petoari galdetu diot, esaidak Abu Bekar, eta paradisuan zein hizkuntzatan mintzatuko gaituk? Arabieraz, zalantzarik gabe –erantzun dit– hori baita lehen gizakiaren hizkuntza. Lekutan daude uste zutenak Adan eta Eba euskaraz mintzo zirela!

# Kartzelako kronikak -VII-

Herria 2000 Eliza 240. zk. 2012
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/justizia/at_download/file

**Irakurle hori, agur t'erdi**

Uste daitekeen kontrara, kartzelako bizimodua ez da osoki norberari dagokion modulu barruan egiten, hau da, nahi izanez gero, beti baimena tarteko, badago aukera bestelako jardueretan parte hartzeko, horiek deportiboak izan, kulturalak, ikaskuntzakoak, erlijiozkoak, etab. Badira zenbait kide holako ezertan parte hartzen ez dutenak, noski, eta ezin dutenak ere bai, lehenengo graduan sailkatuak edo isolamenduan daudelako, baina gehienontzat aukera hori badago, ezelango makurtze-prozesurik gabe.

Modulutik, hots, kartzelak esleitu dizun pabiloitik ateratzea atsegina izan ohi da; burdinazko atetzarrak zuretzat irekitzen direla ikusteak badu bere zirrara; erlatiboa, jakina, kartzelako esparrutik ateratzerik ez daukazulako eta, jarduna amaitu ondoren ostera itzuli behar duzulako zure txokora. Itzultze horiek bereziki mingarriak izan ohi dira, adibidez maite dituzunak besarkatu (edo soilik behatu) eta leiho barrotedunetatik begiratuz etxeratzen ikusi behar dituzunean, erremediorik gabe urruntzen hurrengora arte.

Bada, joan-etorri horietako batean, kiroldegitik edo eritegitik ez naiz gogoratzen, gazte bat hurbildu zait; paper batzuk luzatu dizkit, begiratzeko erregutuz. Ezagutzen dut mutila; lituaniarra da, segaila, itxura mardula du. Bertako kiroldegian eta igerilekuan monitore-zereginetan ibili ohi zen harik eta gaixotu zen arte. Oso gizon erlijiosoa da nonbait. Diotenez, txaboloan zegoelarik barruko txirrina jo eta jo hasi zen, Jainkoa handik ateratzea agintzen ari zitzaiola eta, beraz, irekitzeko atea. Ireki, ireki zioten, bai, eta egundoko jipoia eman ere bai. Kolpeen eraginez ospitalean bukatu zuen eta handik bueltan, argal-argal itzuli zen; ez ordea barrutik aldatuta. Gogoan dut, behin, dentistaren zain nengoela, beste preso batzuekin, nola aurreko itxaron-gelatik mintzatu zitzaion nire ondoan haginetako minez zegoen marokoar bati: "Jesus nor den badakizu" (zin dagizut nitaz ari zela pentsatu nuela; baina ez, Nazarethekoari buruz zebilen). Ezulertze-keinua egin zion besteak eta lituaniarra parrastan hasi zen, ele eta ele. Lotsaturik, haren aurpegiko zauriei erreparatu eta nire aulkira erretiratu nintzen… Eldarnioa ez zaio sendatu, nioen nire artean…

**Begiratu ditut paperak. Banengoen, bada, ni…!**

Jehovaren Lekukoen propaganda da, eta dio: "Ezagutu nahi al zenuke egia?. (…), adiskide, Jainkoa gutaz arduratzen ote den, hil ondoren zer gertatuko zaigun, edo zoriona aurkitzeko moduak zeintzuk diren…?" Erantzuna, noski, Biblian aurkitu behar dut, eta horretarako, Lekukoek kartzelan, asteazken eta igandeetan egiten dituzten bileretara joanez hasi beharko nuke. Instantzia /inprimakia) bere letraz idatzita eman dit, Zuzendariari igorrita, nire sinaduraren faltan. Bapo, plangintza osoa doan!

Ez da bakarra, azken boladan, ni konbertitu nahirik dabilena. Gauza bera gurako luke nire adiskide musulmanak. Horren estrategia ezberdina da. Xalo-xalo uzten dizkit islamismoari buruzko liburuak, idazkiak, etab… Elkarrekin gabiltza, elkarrekin ikasten dugu ingelesa, elkarrekin kentzen dizkiogu itzuliak patioari egunero. Musulman zintzoa da, zorrotza eta saiatua. Bere altxor preziatua topatu du erlijioan, delinkuentziatik aldentzen lagundu diona berau eta, ulergarria denez, nirekin partekatu nahi du. Egia topatu du; bakarra eta zalantzabakoa, eztabaidaezina eta interpretaziorik behar ez duena bere biluztasun liluragarrian. Atsegina dut gaia, atsegina dudanez, baina ez dit betarik ematen nire zalantzetarako. Entzun eta irentsi, besterik ez zait geratzen. Ebidentziak ez dira eztabaidatzen. Nola azaldu erlijio guztiak sakonean jatorri berekoak direla, ez dagoela alde handirik? Ezin. Nola azaldu erlijioak, ideologiak eta balore-sistema oro bezala, gizakiak berak mamitu dituela bizitzari zentzu bat eman (edo topatu!) nahirik? Ezin. Nola adierazi, Jainkoak, izatekotan, ezin diola herri bati, jendarte bati, eta soilik berorri, zer den ona eta zer txarra belarrira kontatu? Ezin. Nola xehatu zientzia, politika, etika, erlijioa arlo ezberdinak direla, ezin direla nahastu, bakoitzak bere autonomia duela? Ezin. Nola ulertarazi erlijioa ezin dela ezarri gizarte plural batean, arau bakarra izan dadin, ustez Jainkoaren hitza eztabaidaezina delakoan eta araubide zuzen bakarra? Nik behintzat… ezin. Zein zaila den aniztasuna onartzea gizarte-harremanetan! Nolanahi ere den hunkigarria da nire lagun honek erakusten didan arreta. Iruditzen zait adinagatik dela, bere askatasunaren alde borrokan ari den herri bateko kide izateagatik ere bai; baina funtsean, nonbait, adinak sorrarazten dion errespetuagatik dela dirudi. Aldika sutsuki eztabaidatzen dugu, baina beti bukatzen dugu itzulia “my friend” esan eta bostekoa emanez.

Proselitismo-joerak gorabehera, pentsamendua eta sineskerak arazteko balio dit niri. Izan ere, jadanik ez naiz sistema itxi baten baitan bizi, ez gotorturik. Irekita dauzkat bihotz-leihoak. Azken hilabeteotan Higgis-en bosoiarekin bueltaka ibili dira. Ez omen dute “harrapatu “, baina “hor” omen “dago”. Ikerketa horretan parte hartu duen bati entzun diot: “Norbaitek guztiaren hasieran printzipio erlijiosoa jarri nahi badu, guk ezin diogu ezetzik esan, guk ez baitakigu erantzuna”.

**Askatasun-eskean**

Kartzelara itzuliz, (gorago esandakoagatik konturatuko zineten badirela moduak hemendik alde egiteko) batzuk diote hemen bagaude ateratzea “eskatzen” ez dugulako dela, alegia geurean tematzen garelako. Ez da horrela. Hamabostean behin egiten diogu eskaria Zuzendaritzan eta 2012ko udaberrian Audientzia Nazionalari eta Gobernuko Presidenteari egin diogu. Soilik Audientza Nazionalak erantzun digu.

Gaixoen, 3/4ak beteta edo baldintzapeko askatasunean egon behar luketenei buruz:

“La petición del interno debe ser rechazada de plano, en tanto que reclama por otros la obtención de libertad (…). La legitimidad para recurrir la tiene exclusivamente el Interno y el Ministerio Fiscal. En el caso que nos ocupa se reclama por otros, los cuales no consta que conociesen o consintiesen tal petición, ni que estén incapacitados para realizarla, motivo por el que debe ser inadmitida de plano la petición por carecer de legitimación activa del peticionario.”

Etxera trasladatzeari buruz, berriz, hauxe:

“Las resoluciones de la Administración en materia de traslados (o su denegación) son recurribles ante la jurisdicción contencioso-administrativa, no ante el Juzgado de Vigilancia Penitenciaria. Por tanto este particular de la queja excede de las competencias de este órgano judicial”.

Seguru aski arrazoia dute alde teknikoari dagokionez… baina onartu nahi ez dutena da kolektibo bat garela eta eskaria denok aldi berean egiten dugularik -nahiz eta norberaren sinaduraz- balio gabe uzten dute. Kolektibotik aldenduta, karneta ahoan, belauniko eta barkeske nahi gaituzte.

Eta amaitzeko, pelikula. Jakingo duzu “Barrura begirako leihoak” dokumentaleko atal batean parte hartu dudala. Ikusteko, atera arte itxaron beharko dut. Bitartean iruzkintxo bat egin nahi nuke. Nago, nire atalak ez duela oso mezu baikorra ematen, nire bizitzako unerik beltzena erakusten duelako, gertatu zen bezala: erorialdia eta irteera. Hala ere nik honako zatitxo hau prestatu nuen bukaerarako, gidoiaren arabera kabitu ez zena: “Nondik natorren badakit, zer bide urratu ditudan ere bai. Itsaso zakarrean sartu naiz, zerua errukigaitz. Zernahi ere den nire paraderoa, nik erabakian eta iraupenean sinesten dut; horixe besterik ez da gure barne-sua argitzen duen zortzi puntako izar berdea.”

Agurtu aurretik, lerro hauek bidali nahi ditut Eguberri eta Urteberri atariko nahiak adierazteko: Zoriona, Askatasuna eta Osasuna. Gora Euskal Herria. Besarkada eta muxu bana nire ondoan zaudetenoi eta kronika hau irakurtzeko patxada hartu duzuenoi. Ez adiorik.

# Kartzelako kronikak -VIII-

Herria 2000 Eliza 244. zk. 2013
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/independentziarantz/at_download/file

**Irakurle hori, agur t'erdi**

Beste behin zuregana zuzendu nahi dut hemengo leku, jende eta zerari buruzko berri emateko asmoz. Oraingo honetan Herria 2000 Eliza-ri zorionak emanaz abiatuko dut Kronika hau. Izan ere, 35 urte bete(ko) ditugu ekainean, eta bada meritua honaino iristea; beraz, nire zorionik beroenak une honetan aldizkaria egin, banatu eta irakurtzen duzuen guztioi. Bide batez hona ekarri ninduenetik zendu diren lau eragile-sustatzaile gogoratu nahi ditut: Joseba Goñi, Jesus Lezaun, Josu Goldaraz eta Felix Bergara. Nire kezka bakarra, lau gizon handi horiek ezin ordezkatzea, eta horrek pentsaraztera narama, baina hori belarrira kontatuko dizuet hurrengo batean. Bitartean, TOPA honaino iristeagatik. Hemen barruan badago gure aldizkaria irakurtzen duenik, baina jakizue askok porroak erretzeko ahokoak egiteko darabiltzatela orriak…

Nire kartzelaldiari dagokionez, beheranzko bidean noa; izan ere, bost urte t'erdi eginak, bi herenak gaindituta dauzkat. Egoera normal batean bizi eta preso normal bat banintz, kalea bisitatzeko aukeran nengoke, baina oraindik ez omen gaude tenore horretan.

Beheranzko bidean kaskarrekorik ez hartzea espero dut. Badaezpada neurriak hartzen hasita nago, besteak beste, nire etorkizun hurbila prestatzen: U.P.V-ko ateak irekita dauzkadala gaztigatu didate, eta sartzea erabaki dut, 70 urte bete arte. Atetzaharra erroetatik mugitu eta konturatu naiz karranka dezente egiten duela, armiarma-sarez eta hautsez estalita topatu dut, eta oharturik nago berez ez dela aise irekiko, nire bultzada sendoa beharko duela, alegia… Beno, irakurle, zuzenago mintzatuko natzaizu, hautsa eta armiarma-sareak nire burmuinean daude eta dagokidan denboran horiek erretiratu eta txukuntzen arituko naiz, guztion hobebeharrez: nire hobebeharrez eta balizko ikasleen hobebeharrez. Neska-mutil horiekin ametsetan nabil, nire trakeskeriak kalte ez ditzan. Edozein moduz esku-liburuetan murgildu ahala, gero eta ezagunagoa egiten ari zait nire antzinako lan bikoitza: kazetaritza eta irakasketa. Indarrez sentitzen naiz, alafede, berriro ofizioarekin konpontzeko, berraztertu eta besteengana txukun eta taxuz hurbiltzeko. Beraz baztertu ditut itzulpenak eta bestelako gutiziak ostera langintzan saiatzeko. Hona ekarri nindutenean lan arauturik ez nuela egingo deliberatu nuen, baina lan arautura itzuli naiz, nire buruarekin erronka zahar-berrituan.

Ez naiz lehengoa, urteak ez dira doan pasatzen, hainbat aldetatik begiratuta arrakalatu eta higatu naiz, baina eskarmentuan ere irabazi dut; gutxienez burua ez zait herdoildu, inoiz baino arinago eta zorrotzago dabilkit, beraz, utikan erostak!

**Haluzinatzen ala higatzen**

Existitzen ez garen arren preso politikook kezka berezia daukagu gaixoekin: hemen ez dadila inor hil edo erremediorik gabe herbaldu. Larrien daudenen izenak ezagutzen dira, baina asko daude handik edo hemendik ukituta. Bizitzaren legea da gorputzak ahultzea, ez dago horri itzurtzerik, baina baldintza txarretan biziz gero azkarrago higatzen da gorputza. Eta kartzela ez da baldintza egokienak batzen dituen tokia; kasurik onenean ere ez. Gehienetan arazoa ez da zer gaitz daukazun, baizik aurre nola egiten diozun, eta hor norberaren izaera eta baliabideak sartzen dira jokoan: ahalmenak, indarra, jarrera eta determinazioa. Eta zer diren gauzak, bat makaltzen hasten denean errazago ohartzen da aldamenekoei gertatzen zaienaz.

• **H.** aljeriarra da. Ez du inorekin hitz egiten. Luze-luze etzanda pasatzen ditu egunak patioko bazter batean, kapusaia sudurreraino jaitsita, eguzkitan zein euritan. Albotik pasatuz gero, marmar etengabean sumatuko duzu.

• **A.** bizirik dago, batek daki nola; birika bakarra dauka, gibela, giltzurrunak, pankreas seko izorratuta; makina bat behar izaten du arnasa hartzeko. Bihotzetik operatuta dago, nekez ikusten du, eta hor dago nora ezean.

• **D.** ere isil-isila da; katu batek baino zarata gutxiago egiten du ohiz. Loto-jarreran eseri eta ekialdeari begira egon ohi da. Biagotik jaikita, zeuzkan traste guztiak atera ditu galeriara: koltxoia, arropa, oinetakoak, poltsak eta funtzionarioari oldartu zaio garrasika. Dozenaka igo eta buruz behera eraman dute, gu guztion oihuen artean. Ez daukat zalantzarik kartzelak eragin haluzinagarriak dauzkala. Kartzelak eta kontsumitzen diren produktuak, jakina. Ohikoa da jendea elkar-joka ibiltzea, baina orain arte ikusi gabea nintzen musulman batek besteari “moro de mierda” esanaz labana astintzea; edo errusiarren kontra gerra egindako afganiarra errusiar batekin xake-jokoan aritzea, lasai asko.

• **N.** ijito kastakoa da. Biblia irakurtzen jarduten du eguna, ahal badu ozen, denon aurrean, begiak zuri. Aurreko batean, jendea futbolean ari zelarik, erdi-erdian paratu eta garrasika hasi zen, pasarte batzuk errezitatuz, jokoa galaraziz. Eskolan geundela, xalo-xalo hurbildu zait: “Begira, Jainkoaren mandatua betetzen ari naiz, dei bat egin behar dut, txartela utziko bazenit…”. Zeukan arropa guztia bota du zaramara: “Jainkoaren esana betetzen ari naiz”… eta hola.

• **B.** borrokatu egin da eta zigor-ziegara bidali dute: “Bi egun eman ditu, ohean, uhalez lotuta, buruz behera, janaririk eta edaririk gabe, garrasika, pixa eta kaka gainean eginez”.

• **K.** izututa bizi da. Bostak aldera esnatu eta jantzi egiten da. Nahita ere ez dauka sosegurik hori egin gabe. “Altxatu beharra daukat, norbait sartuko zaidan beldurrez. Batzuetan lo geratzen naiz, baina badaezpada ere”… Oraindik ere ez zaio ahaztu gazte txoa zelarik, funtzionarioak sartu eta egurtu zuten garaia.

Etab.

Ni neu ere tirriki-tarraka nabil, aldakako minez, belauneko minez, ibili ezinik. Gaitz erdi, burura igotzen

ez zaidan bitartean. Aspaldiko adiskide batek idatzi dit, esanaz: “Giltzadurak oro minduta dauzkazunean, ukalondoak, eskumuturrak, belaunak eta aldakak… orduan zaude helduta”. Hara, bada, holako zerbait.

Albo-alboan ere izan dugu gaitzik: kide bati buruko pantaila itzali zaio, punba, bat-batean, eta asteak behar izan ditu ostera pizteko. Berriro onik dago, eta gu pozik.

Beno baina jendeak herri-harresiak eraikitzeari ekin dio, desobeditzeko gai dela erakutsi nahi du, beste justizia-molde bat sortzeko bidean eta guri, harresi arrotz hauen barruan bizi garenoi, zirrara berezia egiten digu jendea amore emateko ez dagoela prest ikusteak, eta irudimenak ez daukala mugarik. Eta pentsarazten digu, niri bederen, non jarri beharko dudan nire alea. Irtendakoan, alegia.

# Kartzelako kronikak -IX-

Herria 2000 Eliza 246. zk. 2013
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/bestelako-politika/at_download/file

**Irakurle hori, agur t'erdi**

Herri-harresien aipamena eginez bukatu nuen nire azken kronika, zortzigarrena. Orduz geroztik beste batzuk sortu dira: Ondarroan eta Iruñean, eta dirudienez jendea prest dago han-hemenka, premiaren arabera, beste hainbat eraikitzeko, harriz harri, adreiluz adreilu. Ez dakigu zein den irudirik egokiena lortu nahi duguna deskribatzeko, izan ere tantaz tanta ere saiatu behar omen dugu, eta beraz, auskalo. Kontua da, nire azkenengoan nioena errepikatuz, jendea ez dagoela amore emateko prest, eta irudimenak ez dauka mugarik. Tantaz tanta olatua gauzatuz edo harriz harri hesia eraikiz estatuaren zitalkeriari erantzun beharra dago. Okerrena da antzematea zenbat energia xahutu behar dugun jada aspaldi gaindituta egon beharko luketen zenbait gai oztopatzeko: atxiloketak, epaiketak, eta oro har errepresioarekin lotuta dagoen guztia. Argi dago gure erritmoa ez dela estatuena: gurea azkarra, eurena motela.

Nire kronika ez zuten irakurriko epaileek eta atxilo gaituzten erakundeko arduradunek, baina opariz edo, Donostiako Bulebarrean sortutako Askegunean harrapatutako gazte bat bidali digute: Oier Lorente, eta hiruzpalau hilabeteotan gurekin dago, 11. moduluan, bere bizitza egiten, gurea alaitzen eta elkarrekin gogoetak egiten, ofizialki geratzen zaizkion 4 urteak betetzeko. Xapo, Luis eta Urtza ere hor nonbait egongo dira, egoera bertsuan, euren herrietako irmotasun-erakustaldietan parte hartu ondoren.

**Bat sartu, bestea irten**

Holaxe gabiltza errotarrian, horixe da nire esperientzia. Nire moduluan 7 bat lagun ikusi ditut kaleko atea hartzen, eta kronika hau argitaratzen denerako, Mikel Vargas Olasolo ere Amaran izango da, bere gurasoekin, arrebarekin eta hainbeste maite duen koadrilarekin. Agur, adiskide! Irten baino lehen esan diot faltan hartuko dudala, berak badaki.

…Agian besteren batek ere berehala utziko gaitu, hemen ere bai baitago 197/2006 doktrina ezarri ziotenetako bat: Raul Ibañez. Pozez hartu dugu Estrasburgen emandako epaia, behingoz gure alde. Beste hainbat konponbide batzuei buruz ezkorragoa naiz, baina honetan ez dut zalantzarik eduki. Apustu guztiak irabazi ditut. Ahal izan dugun erara ospatu dugu: eguerdian gazta, txorizoa, urdaiazpikoa, garagardoa eta zuku batzuk hartuz, eta afalorduan tarta bat dastatuz.

Omenaldi xumea bezain beroa zigorra propina eta guzti bete duten kideentzat. Ez al dira biktimak umiliatuta sentituko! Ez dago ukatzerik doktrina hori Espainiako kartzela-sistemaren koroako harribitxia izan dela, eta gabe geratu direla, inpunitatez eta bidegabeki aritzeagatik. Nik neuk nolabaiteko mendekuren bat espero dut: atxiloketa sonatu batzuk, bahituon kontrako neurri ziztrinen bat, zeozer. Ala

ez, batek daki; baina argi ibili. Hurrengoan mintzatuko natzaizue, hurrengo kronikan.

Pasa den Gabonetatik hona txabolo-aldaketa nozitzen ari gara: gure poltsak, arropak eta tresnak hartu, koltxoia barne, eta haruntzago edo honantzago dagoen ziegara aldatzen gaituzte. Jar gaitezen positibo: hori ez da ezer kalean hainbat familiak jasan behar izaten duen etxegabetzerekin, zer arraio! Ez da ezer hainbat kidek urtetan ezagutu duten modulu- eta espetxe-aldaketarekin. Hala ere amorragarria izan ohi da ahalik eta erosoen instalatu zarenean, espazio zabal samarrak ikusi ordez zure begiek aurreko paretan jotzearekin konformatu zarenean, berriro poltsak bete, liburuak batu eta arropa tolestu behar izatea, beste txabolo batera joateko, berdintsua zorionez, askotan beste kide batek erabili duelako, izan bai baitira zeharo zikin eta zahartuta daudenak, garbitu, desinfektatu, txukundu, atondu eta egokitu behar izaten direnak. Azken aldaketa Herrira-ren aurkako sarekadaren biharamunean izan da (kointzidentzia hori ere?). Oraingo honetan aukera dut ostera landak ikusteko, zuhaitzak, mendi-muinoak, eta urrunago, haize-errota industrialak, Cerrato eskualdeko haizeak biraka… Zerbait da!

Ama Mesedeetakoaren egunean izan zen. Egun hori atxilo gaudenon egun seinalatua da egutegian, eta kartzela-sistemak otordu bereziak prestatzen ditu guretzat. Ez da beste munduko oturuntzarik, baina, tira, beste zapore batzuk gogoratzeko balio izaten du: langostinoak, piper beteak, ardi zahar kiskalia, izozkia, arrainen bat, kafea. Hainbatek, festa-eguna behar bezala ospatu behar delakoan, pattarra prestatzeko erabili ohi dute, oso modu harrigarrian hartzituta. Eta jakina, gero ondorioak etortzen dira: borroka bat izan ahal da, katxeo orokor bat alkoholaren peskizan, edo auskalo zer. Aurten talde bat oilartu egin da, siesta ondoren, flamenkoa ikustera joateko eskubidea zutela eta ez zutela. Oilartu bai, eta gandorrean jaso ere bai. Bizkarra ondo berotuta atera dituzte modulutik isolamendura -bidean, eta gero bestelako zigorrak helduko zaizkie, mutin-saiakera egin dutelakoan, oihu malapartatu eta inozoak besterik izan ez direnak. Hau horrelakoa da, autoritarismo gordinaren erresuma: adibide bikaina indar, lotsagabekeria, lapurreta, trapitxeoa eta marginazioan bizi izan direnentzat, legea eta arauak errespetatzen irakasteko saio baldarra…

**Tarragonako martiriak**

Urrian idazten ari naiz, eta urrian ehunka fraile eta lekaime dohatsu izendatu ditu eliza katolikoak Tarragonan. Horren harira nire haurtzaroko anekdota bat kontatu nahi dizuet. Hamar bat urterekin seminariora sartu nintzenean, haiek ziren gure heroiak, martiriak. Gorriek garbitu zituzten, 36-39ko gerra zibilean, eta asko eta asko, berrehun bat, gureak ziren, gure kongregaziokoak, klaretarrak. Kontatzen zigutenez, eta halaxe gertatuko zen, gehienak seminarioan bertan akabatu zituzten gazte haiek, Alagonen eta Cerveran, hantxe ikasten baitzuten, edo irakasten jadanik apaiztuek. Beste batzuek, aldiz, ihes egitea lortu zuten eta masiatan ezkutatuta edo mozorroturik ibili ziren, gorriek atzeman eta garbitu zituzten arte. Buruz genekizkien haien izen-abizenak, ezkutatzeko erabilitako etxe eta bordak, alderrai gurutzatu zituzten herrixkak, gehienak Herrialde Katalanetan; non jaio ziren, zenbat urte zituzten, zer nahi zuten bizitzan, eta haien ereduarekin edoski gintuzten, haiek bezala izateko hezi ginen. Gero, denborak aurrera egin ahala, jakin genuen ez zirela gerra-garaian eraildako bakarrak; “nazionalek” (alegia kristauek, urdinek) garbitutako apaizak ez ziren gutxi izan, gure kongregaziokoak ere bai, adibidez Jose Zabala-Arana nabarniztarra; edo Aitzol, Ariztimuño tolosarra, eta beste hainbat. Eta… eta… antza denez, azken horiek ez ziren martiriak izan, horiek ez zituzten kanposantuko hormaren kontra fusilatu; beraz, ez dute merezi

gaur egungo kristauek gogoratzea, imitatzea eta loriatzea, horiek ez baitaude Eliza katolikoaren dohatsuen artean. Ai ama maitea, non ote zaude!

**Errenka, pazientziaz**

Behar bada, irakurle, jakin nahiko duzu nire osasunaren berri, eta beste era batera adierazterik ez daukadanez, lerro hauetan azalduko dizut. Aurreko kronikan, 8.ean, aurreratu nuen tirriki-tarraka nenbilela, belauneko minez, aldakako minez. Eta halaxe jarraitzen dut, hobeto ez. Orain badakit diagnostikoa: meniskoa puskatuta belaunean, eta trokanteritis aldakan. Ospitalean esan didatenez, belauna operatzea ez du oraindik merezi, handitzen ez zaidan bitartean, eta bijilatzeko; aldakari dagokionez, bi aldiz egin didate infiltrazioa, hanpadura jaisteko, harrapatuta daukadan tendoia libratzeko. Aldaketa handirik ez dut nabaritzen. Luzerako dela esan didate eta pazientziaz hartu beharko dut patioan ordu laurden bat baino gehiago jarraian ezin ibiltzea, eskailerak eskudelari oratuz igotzea, ohean etzanda min sorra sentitzea. Pazientziaz. Nire zine-zuzendariak, Enarak, esan dit emozioak kontrolatzeko, beti eragin txarra izan dutelako norberaren puntu ahuletan, negatiboak edo bortitzegiak direnean. Aholku jakintsua! Hemendik irtenda mendian eta hondartzan ibiltzea nuen amets. Ez dakit ba… Et, et, et, horiek gogoeta negatiboak dira; ez da hala, Enara?

# Kartzelako kronikak -X-

Herria 2000 Eliza 249. zk. 2014
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/diktadura-berrirantz/at_download/file

**Irakurle hori, agur t'erdi**

Lerro hauek uda aldean argitaratuko diren arren, Aste Santuko atarian idazten ari naiz. Komunikabide azkarren aroa ez da guganaino iritsi. "Mendeku txikiren bat" gertatuko zen susmoa neukan IX. kronika idatzi nuenean; izan ere Estrasburgoko epaiak, gure kolektiboaren abenduko idazkiak eta kaleratuen Durangoko bilkurak horretarako eta gehiago ematen baitzuen.

Ez dakit horrekin oso lotuta egongo diren, baina niri gertatu zaizkit episodio adierazgarri batzuk, jarraian kontatuko dizkizudanak. Goian aipatu ditudan aldeko atal horien ondoren, nire lagun Txema Erdozaini hona bisitan etortzea debekatu zioten, "kazetari lanetan" dabilelako hain zuzen. Arrazoi bitxia, inondik ere, inon ez baita zehazten zein lanbide diren desegokiak preso bat bisitatzeko. Bertoko Segurtasun arduradunari deitu nion azalpen bila, eta pixka bat estutu nuenean benetako arrazoia eman zidan, nire ustez. Hauxe: "zuekin gauza arraroak gertatzen ari dira azken boladan". Geroztik hor gabiltza bidegabekeria hori zuzendu nahirik. Txemak kontatu du bere partea, ustel atera zitzaion telefono-deia, eta nik galdu dut lehenengo helegitea; orain A.Neko Penaleko Salaren ebazpenaren zain nago. "Gauza arraroak", beraz, "mendeku txikiaren" antz handia dutenak.

Hori gertatu eta egun gutxira beste txabolo-aldaketa nozitu genuen denok, hamalau hilabetetan laugarrena. Goiko pisura igo gaituzte berriro. "Zuek ezin zarete beheko solairuan egon, FIES zarete eta", esan zigun aldaketaren berri eman zigun funtzionarioak. "Eta zeinek jaitsiarazi gintuen orduan?", erantzun genion, poltsak eta paketeak bizkarrean hartuta. Tira, ostera ekialdeari begira gaude, ziegak epelagoak dira, eta ikusmenerako egokiagoak: inguruko soroak, hurbileko muinoak eta aldameneko errepidean autoak ikusten ditugu… Luxu bat, urtebetean aurreko horma besterik ikusi ez dugunontzat.

**Zigortuta nago**

Ez da jaso dudan lehenengo zigorra, baina oraingoan gogor samarra ezarri didate; bidegabea batik bat, eta neurriz kanpokoa. Irakurri: hiru asteburu ziegatik atera gabe, ez eta otorduetan ere, eta beste 60 eguneko arratsalde guztiak ere berdin.

Hola esanda, zerbait larri egingo nuen; aldiz huskeria izan zen. Aurrez aurreko bisita daukagunean ohitura da patioan geratzea edo txabolora igotzea afaltzera jaitsi aurretik arropa aldatzeko. Bisita-egun horietako bat suertatu zitzaidan, eta ondoren, 5,30 aldera, ziegazainen leihatilara hurbildu nintzen.

• Mesedez, irekiko al didazu 48. ziega, nirea?

• Ez daukat zuri zertan ireki.
• Sei urte daramatzat modulu honetan, eta zure lankideek beti ireki didate atea, eskatuz gero.
• Ba nik ez daukat zertan ireki.
• Baina arratsaldeetan ez nago behartuta patioan geratzera. Aukera daukat.
• Esan dizut, eta ez dizut irekiko.
• Hartara denuntziatu beharko zaitut. – Eta patiora joan nintzen.

Handik hilabetera edo, partea. “Errekurrituko al duzu”, esan zidan agente judizialak. “Errekurritu? Huskeria bat izan zen. Emaidazu zigorra eta beteko dut”. Zain geratu nintzen. Beste hogei bat egun pasata, zigorra: desobedientziagatik, errespetu faltagatik eta koakzioengatik.

Eta ez da azkena izango. Beste bi zigor dauzkat zain, hamarna egunekoak, leihoen azpiko korridorea ez garbitzeagatik. Jendeak leihoetatik edozein gauza botatzen duenez, zuzendariak agindu zuen denon artean, txandaka, garbitzea. Preso politiko guztiok eta hiruzpalau arruntek uko egin genion ordenari: hiru agindu, hiru parte. Nire kasuan, A.N.k arrazoia eman zidan, esanaz garbiketari dagokionez, presoaren betebeharra txaboloa txukun mantentzea dela, eta gainontzerako, arduradunak jarri behar direla, eta saritu. Beno, bada, epailea aldatu dute, eta pikutara bidali dizkit hurrengo bi helegiteak. Kitto. Justizia. Beraz, badakizue, ekainaren bukaera arteko arratsaldeak ziegan pasatuko ditut… honen antzeko idazkiak egiten.

**Apaizak hobeto**

Pasadizo hau pixka bat zaharragoa da, baina oraindik ez dut behar bezala kontatu. Halako batean kartzelako apaiz batek deitu ninduen, esanaz Garaikotxea izeneko lizentziatu batek idatzi ziola Urruguaitik. Itxuraz, Elduaingo gure aitona Mieljoxeren lehengusu baten semea zen, Ameriketan jaioa. Nire izena Interneten irakurria zuela eta ea harremana nahi nuen berarekin. Baietz esateko eskatu nion apaizari, baina gaur arte. Lastima. Gero apaiza desagertu egin zen ludopatia-arazoren baten erruz hemendik aldenduta, baina aldika beste apaizen bat etorri zait bisitan, nola nagoen, zerbait behar ote dudan etab. galdezka. Nonbait enteratuta daude ni ere apaiz izana naizela. Eta asko estimatu diet jarrera.

Kapilau horietako bat frailea da, eta hiruzpalau aldiz bisitatu ondoren berak zuzentzen duen aldizkari batean idaztera gonbidatu ninduen: “Askapen-bideak”. Pentsa! Idatzi nuen, berak eskatutako eran eta neurrian. Baina, hara, argitaratu baino lehen, penatuta hurbildu zitzaidan, esanaz, kartzelako agintarien aginduz, ezin zuela nire idazkirik argitaratu. Eta harremana ere eteteko. “Lasai, gizona, ez kezkatu. Berdin eskertzen dizut zure ahalegina”, esan nion. Ez dut gehiagotan ikusi. Jatorra eta hurbila zen. Errespetuz hitz egiten genuen (beti kartzeleroen begiradapean) …baina mugak muga dira. Gaur arte. Lastima, ostera. Nirekin adi ibiltzeko esan omen zioten. Ez nekien arriskugarria nintzela. Sinisten hasi beharko dut…

**Bukatzeko, kezka bat**

Ez da harritzekoa barrutik bidaltzen ditugun mezuak erabat zuzen ez ulertzea, baina kezkatxo bat badaukat 2013ko abenduaren 29n argitaratu genuen mezu “historikoari” buruz egiten ari diren irakurketa okerrez, batik bat gure ordezkari politikoek egiten dituztenean. Izan ere, esaten ari da euskal preso politikoek legea betetzea erabaki dugula. Nire iritziz hori ez da horrela. Ni ez naiz inor inoren iritziak zuzentzen ibiltzeko,

baina hobe beharrez gomendatzen dut idazki hura berrirakurtzea, batez ere 5., 6. eta 7. puntuak.

Guk esan duguna da: a) salbuespen-neurriak eta kartzelako politika “errotik” aldatu behar direla; eta tresneria judizial-juridikoa “egoera politikora” egokitu; b) “horiek horrela” (aldatuz gero) ontzat eman “dezakegula” gure etxeratze-prozesua “lege-baliabideak erabiliz gauzatzea”; eta c) “prest gaudela” prozesu hori aztertzeko eta jorratzeko “egitasmo orokor baten baitan”. Laburtuz: legedia onartu bai (“aurrera begira legeek eta beren aplikazioek berebiziko papera baitute”), baina justu eta egokiagoa denean. Zaballara joatea eskatzen ari gara, horretarako lege-aldaketarik behar ez delako…

…Beno, nire kartzelaldia azken fasean sartu da. Urtetan ez, hilabetetan kontatzen hasi naiz: orain 20 hilabete falta zaizkit 2015eko azaroaren bukaera arte. Eta urduritasunaren lehen zantzuak ere nabaritzen ditut, goiztxo den arren. Zorionez, osasun-arazoak bideratzen hasi dira, gainera.

# Kartzelako kronikak -XI-

Herria 2000 Eliza 252. zk. 2014
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/ama-lurra/at_download/file

**Irakurle hori, agur t'erdi**

Askotan galdetzen didate adiskideek noiz aterako naizen, zulo hau behingoz utzita. Bada, zehazki ez dakit. Zortzi urteko kondena ipini zidan Auzitegi Gorenak, Angela Murillo buru zuen Epaimahiari bat kenduta, eta aritmetikaren arabera 2015eko azaroan atera beharko nuke (26an uste dut), baina, antza, pixka bat lehenago izango da. Izan ere, dirudienez, espetxera sartu aurretik A.N.k jarri zizkigun neurri kautelarrak kontuan hartzen ari omen dira. Gure kasuan astero sinatzea izan zen neurria. Eta adierazi zaigunez hamar sinadura bakoitzeko kartzela-egun bana kenduko digute. Zenbat kenduko didaten ez dakit zehazki. Dakidana da (ia) zortzi urte joan zirela EGIN itxi zutenetik epaiketa hasi zenera arte. Beraz, litekeena da 2015eko urrian kalean egotea. Besterik ezin dut esan. Idatzi diet abokatuei nire egoera aztertzen hasteko. Hortik aurrera, itxaron. Nolanahi ere den, hurrengo kronika azkena izango da.

Nonbait ez naiz oso preso txukuna izan. Sei hilabetean behin egiten diguten azterketaren (!) arabera ez naiz kartzelako bizitzara egokitu eta, beraz, nire kalifikazioa da "*deficiente adaptación penitenciaria*". Lehen begiratura, gogorra dirudi kalifikazioa. Barruko araudia ezagutzen ez duen edonork esango luke portaera bihurria daukadala kideekin, kartzelazainekin eta araudiarekin oro har. Ez zaude, bada, horretarako adinean, esango didate; ez da, irakurle? Beharbada ez zaizu arrazoirik faltako. Aurreko kronikan "zigortuta" nengoela idatzi nizun. Beharbada harrituko zinen. Behin baino gehiagotan idatzi dut desobedientziaz; praktikatu ere bai, zertxobait.

Galdetzera sartu naiz Hezitzailearen bulegora, paperen bat eman behar zidala eta haren deia aprobetxatuz.

• Mesedez, andrea, zer esan nahi du "*deficiente adaptación penitenciaria*"?
• ?
• Ez da zure kontrako ezer, baina kuriositatea daukat, kalifikazioa gogor samarra iruditu baitzait.
• Ez dakit, testuingurua ikusi beharko litzateke.
• Zerorrek jakin beharko zenuke. Zuk ekarri didazu papera. Zure egitekoa da.
• Begiratuko dut testuingurua… Halere aurreratuko dizut guk ezin dugula zure merituak baloratu.
• Bada, ez baloratu. "*Deficiente adaptación*" ipini didazue. Hori balorazio borobila eta negatiboa da.
• Kontua da zuk ez daukazula punturik gure taulan.
• Zein taulan?
• Araudizko taulan. Kartzelak eskaintzen dizun ezertan ez duzu parte hartzen (garbiketan, tailerretan, ikasketa-programetan), beraz ezin zaitugu baloratu.
• Ados, baina orduan ez baloratu. Edozein moduz ni ez nago ezer egin gabe. Horri buruzko informerik baduzue.

• Ze informe?
• Moduluko funtzionarioek egunero osatzen dute txostena nire mugimenduekin. Ondotxo dakite non nagoen, zer ikasten dudan, zenbat ordu egiten ditudan eskolan, norekin nabilen, eserita nagoen ala patioari itzuliak kentzen…
• Horri buruz nik ez dakit ezer.
• Zu zara hezitzailea, eta emaitzak ekartzen dizkidazu.
• Begiratuko dut testuingurua.

Elkarrizketa dirudien baino lasaiagoa izan zen, patxadatsua. Ez nuen "parteri" jaso atrebentziagatik. Hurrengo egunean eman zidan azalpena. Nonbait kezkatuta joan zen andrea.

• Zure txostenean dio zure parteak kitatu gabe daudela (parte bat bete ondoren 6 hilabete joaten dira haren efektuak kitatzeko), abendura arte.
• Mila esker zure arduragatik, andrea.

Edozein moduz beharbada nire izen onerako itsusiegia zatekeen ipintzea: "*muy buena adaptación penitenciaria*". Utikan!

**Zaballarako ezgai**

Dakizuenez, Zaballara lekualdatuak izateko gogoa adierazi dugu EPPKko kideok. Eta (orain bai) legezko araudia betez egin dugu eskaria, kartzela bakoitzeko Tratamendu Batzordean. Azken egunotan (azaroan idazten ari naiz) iritsi zait erantzuna:

"Valorada la carta presentada de petición de traslado se informa desfavorable por cumplir condena por delitos relacionados con organización terrorista no disuelta y de la qaue no consta que Ud. se haya desvinculado ni haya dado muestras en ese sentido".

Bingo! Demagun egia dela hor esandakoa. Kartzelako araudian ez dago inon baldintza hori lekualdaketak eskatzeko (ez eta emateko). Sakabanaketak ez ditu Europako estandarrak betetzen, eta eskubidea daukat / daukagu etxetik hurbilago egoteko, edozein izanda nire / gure delitua. Irakurle zorrotz hori: testuinguruari erreparatu eta garbi edukiko duzu erantzuna. Epaitegietara joteko erabakia hartu dugu, Estrasburgoraino iristeko prest. Bide luzea inondik ere. Baina bidea. Ari gara eskaria osatzen.

Ezustean, beste zerbait iritsi zait, nik eskatu ez dudana: "HITZ-EMAN, legezko bidea" deritzon Jaurlaritzako proposamena. Azpititulu gisara dio: "Presoak birgizarteratzeko legezko prozesuak laguntzeko programa". Abisatzen du zirriborroa dela, eta dokumentua proposamen- eta kontsulta-fasean dagoela. Autorea: Bake eta Bizikidetzarako Idazkaritza Nagusia. 2014ko irailean sinatuta dator. Euskaraz eta gaztelaniaz. Txukun editatuta.

Ni ez noa dokumentua aztertzera. Irakurri ditut bizpahiru artikulu, alde eta kontra. Baina, zer nahi duzu, lotsa sentitu dut mamira jota. Benetan uste al dute Jonan Fernandezek eta enparauek birgizarteratzeko premia dudala/dugula? Zer da birgizarteratzea? E.H.ko gizartera itzultzea? Fisikoki 2015ean itzuliko naiz,

eta arlo sozio-psikologikoari dagokionez, ez naiz sekula urrundu. Nire euskal gizarteko balore asko eta asko konpartitzen ditut, eta beste asko ez. Horiek aldatzen saiatzen naiz, ahalik eta zintzoen. Ni ez naiz inor beste inoren borondatea epaitzeko, baina zer konfiantza izan dezaket kartzelaldi osoan niregana hurbildu ez den norbait(zu)engan?; presoon egoera ezkutuan aztertzen dabilen erakunde batengan? "Konponketa moralak", "iragana kritikoki berrikustea", "hausnarketa autokritikoak", "prozesu etikoak", etab. hitz potoloegiak dira era horretara lantzeko. Prozesu kolektiboak ezin dira maila pertsonalean ebatzi. Hain zaila al da hau ulertzea? Zaila izango da, zaila izango denez! Barkamena eskatzea bada helburua, batek baino gehiagok eskatu beharko lidake niri ere…

**Eguneroko zertzeladak**

Kartzelan ezin da egonkortasunarekin amestu: gutxien uste duzunean, aldaketa. Ederki asko geunden Lander, Oier eta hirurok 11. moduluan. Uda bukatu baino lehen bukatu zen gure poza. Landerrekin utzi naute Oier 7. modulura bidaliz. Han Asier topatu du eta, udazkenean sartuta, hirugarren kidea heldu zaie: Joanmari Maiezkurrena, Hernaniarra, baserritarra. Marturtenetik ekarri dute bere kondena betetzera, etxetik "hurbilago", 60 urteko artzain bati dagokionez. Lander eta biok ziega berberetan jarraitzen dugu aspaldiko partez, ea noiz arte.

Moduluko bizitza asko aldatu da, txarrera. Lasai geunden, 70 bat lagun eskas, 140 sartzen diren espazio batean: zarata gutxiago, jende legala(goa), etab. Bat-batean, egoliarron zenbakia apenas aldatu gabe, jendea aldatu dute: batzuk eraman, beste batzuk ekarri. Egonkorrenak atera, txoriburuenak sartu. Ostera zarata, liskarrak, portaera eskasak, trapitxeo konpultsiboa, begirada okerrak. Gure aurrekoek erakutsitako bideari jarraikiz, ederto eusten diogu egoerari, justuak izaten saiatuz -laguntza behar duenari eman, eta aurpegi gogorra dutenei, stop-, baina nabarmen hondatu da giroa udaz geroztik… berriro aldatu arte, noski, hemen etengabea baita giza trafikoa, batetik bestera.

Niri neuri dagokidanez ederra egin didate, aspaldiko laguna kendu baitidate: Abu Bakr, albaniar musulman petoa. Zehazki zer gertatu zaion ez dakit. Kristauei ez bezala, Jehovaren lekukoei ez bezala, musulmanei ez diete elkarrekin otoitz egiten uzten, ez patioan, ez beren-beregi egokitutako lokal batean. Hori ilegala izateaz gain, iraingarria da erlijioa zintzo bete nahi duenarentzat. Bildotsaren Egunean (Abrahamek bere seme Isaak sakrifikatu nahi zuen eguna gogoratuz) elkarrekin otoitz egin zuten patioan, egun handia ospatzeko. Eta arazoak etorri zitzaizkien. Aurpegia eman zuten biak atera zituzten modulutik: Abu Bakr eta Ahmed Sahararra. Auskalo zer gertatu zen zehazki, ezkutuan atera baitzituzten handik pare bat egunera, siesta-orduko isiltasuna baliatuz. Ohitura hartzen ari zen nire adiskidea edozeini esateko: Allahren lege gizonenaren aurretik dag, eta… batek daki! Hilabete bat isolamenduan eduki ondoren, haren portaera zelatatuz Bonxera (Lugo) eraman dute. Idatzi xume batean gaztigatu dit berria, bere puskak batu eta "kundan" joateko prestatzen ari zela.

Detailerik ez dit eman ni jabetu nadin nolakoa izan den isolamenduko bizitza. Aldiz, Muhammad profetaren hitz batzuk sartu dizkit:

"Zintzotasunak egiarantz eramango zaitu, eta egiak Paradisura. Hartara, Allah-k zintzotzat hartuko zaitu. Gezurrak, ordea, okerrera eramango zaitu, eta okerrak Infernura. Allah Goi-goikoak gezurtitzat hartuko

zaitu”

Ez dakit “egiatia” ala “gezurtia” esan didan, nik bai baitakit okerrean nagoela uste duela, musulmana ez naizelako…

Kontua da ingelesa ikasteko kiderik gabe utzi nautela, nire ikasketa-prozesua geldotuz. Lehen irakaslerik gabe ari banintzen, orain bakar-bakarrik.

Faltan hartuko dut Abu Bakr laguna. Landerrek eta biok faltan hartuko dugu hark egiten zizkigun arroz gozoak, Kosovako erara. Nolako arroz-janak gureak, taperra goraino eta bero jaisten zigunean! Zoriona laster bukatzen omen da, eta hara, horixe gertatu. Lau urte egin ditut harekin, modulu berean. Eztabaida luzeak izan ditugu, erlijioari buruz gehienenak. Egia esan, eztabaidak ez zuen gehiagorako ematen. Agortuta zegoen, ez gai-faltagatik, baizik ezinezkoa suertatzen delako bizitza, unibertso osoa, erlijiozko dogma bakar baten argitan epaitzea, erlijioa bera liburu bakarreko testu literalean oinarritzen denean; zientziak, historiak, ideologiek, gizakien erabaki libreek, psikologiak… lekurik ez daukatenean; gaixotasunak, psikiko sakonak barne, Korana irakurriz sendatzen omen direnean, herriak eta beren askatasuna Allahren ustezko esanetara makurtu behar direnean, erlijiozko komunitate unibertsala amets. Instintiboki, eztabaida utzi eta laguntasuna gordetzea hobetsi dugu. Zer erremedio!

Hale ere asko ikasi dut harreman horretatik, besteak beste, bizitzak arauak oro gainditzen dituela, ez dela haietan kabitzen; nola izan daitekeen pertsona inteligente batek berea besterik ez ikustea, besteona akats hutsa dela sinisteraino. Prozesu horiek beste garaian barru-barrutik bizi izanak asko lagundu dit adiskidearen pentsaera ulertzeko. Eta pena sakona sentitu dut, haren koherentzia pertsonala miretsiz edozein moduz. Allahk lagundu diezaiola, beraz. Dakien hizkuntzatan esan dit Agur.

# Kartzelako kronikak -eta XII-

Herria 2000 Eliza 256. zk. 2015
http://www.elizaherrian.com/eu/herria-2000-eliza/aldizkariak/euskal-estatua/at_download/file

**Hau izango da azkena!**

Arratsalde zorria da. Egutegian udaberria markatu ahala berogailuak itzali dituztenez, ez da giro. Eskolan sartzeari utzi diot, neumonia harrapatu nahi ez badut. Orduz geroztik jantokiarekin erdibana egiten duen galeriako kristalera ondoan esertzen naiz, usu, tapoiak belarrietan ipinita jendearen zarata nolabait apaltzeko. Hala, bozgorailuetatik nire izena esan ote duten peskizan jarri naiz, nirearen bukaera berdina duten beste izen batzuk ere bai-baitaude. Antza, nire izena izan da. Funtzionario bat hurbildu zait, ez ote dudan entzun galdezka. Banengoen bada. Bildu zure gauzak eta joan zaitez sarrerako modulura, esan dit. Agian luze joango zaidala. Zer ote den murtxikatzen abiatu naiz. Bertaratuta, beste funtzionario bat urreratu zait: Zalakain, pasa zaitez segurtasun-uztaitik. Zer egin ote dut… Pasa naiz. Ez du pi-pi-pi jo. Zuzendariordeak ikusi nahi zaitu. Ikusi. Arratsalde on. Erregimeneko Zuzendariordea naiz eta zurekin berba egin nahi dut. Berba. Bulego batean sartu eta aulkia erakutsi dit. Hau serioa da, neure artean. Zuzendariordea naiz. Urte askoan, ez zaitut ezagutzen. Paper bat jarri dit begien aurrean. Hau eskatu didazu, ez? Dakidala, zuri ez dizut ezer eskatu. Kondenaren likidazioa da. Kontxo, hori bai! Audientzia Nazionaleko paper ofizialaren kopia bat luzatu dit. Beraz, irailean zoaz libre. Hala dirudi, bai. Mila esker. Agur.

Horrelaxe adierazi didate ofizialki nire askatasun-eguna: irailaren 27a. Jakin banekien, abokatuak esanda: 60 egun kendu dizkidate. 8 urtetan zehar astero epailearengana joaten aritzeagatik. Baina ni, egoskor, paper ofiziala nahi. Eskatu, kondenatu zintuen epaileari eskatu behar zenion; baina, tira, behingoz… Bai, behingoz albiste on bat: bukatu da nire kartzelaldia.

Maiatzaren amaieran idazten ari naiz nire azken kronika hau. Oraindik lau hilabete geratzen zaizkit: udaberria bukatu eta uda osoa, baina iraungitzat ematen dut nire bizitzaren fase hau. Nire gauzak nola atera aztertzen ari naiz -hiztegi potoloak, liburuak, koadernoak, karpetak-; nire beste hainbat gauza -arropa, izarak eta mantak batik bat- nori oparitu. Gauza handirik ez txaboloa hustutzen. Nire bizitzako 20. etxe-aldaketa izango da.

**Bukatu da, akabo**

Beharbada balantzea egiteko ordua da. Nire irakurle eta lagunek badakizue dagoeneko eginda daukadala. Ikus Ataramiñe'14 (hitzaurrea). Ez naiz errepikatzen hasiko. Hala ere gauza batzuk esan nahi ditut nire azken kronika honetan, espetxetik. Hasteko, eskerrik asko: nirekin egon zareten guztioi: idazten, bisitatzen, animoak eta musuak bidaltzen. Nire gauzen (arroparen, diruaren, liburuen) ardura hartu duzuenoi. Ia-ia ezagutu gabe nirekin harremana josi duzuenoi. Aldika bederen goraintziak bidali dizkidazuen guztioi.

H2000Eko talde osoari: nire ausentzian hain kartsuki eta bikain aldizkaria argitaratzen jarraitu duelako, nik uste baino lan ederragoa osatu duzuelako alez ale, betiko xumetasuna gordez; orobat, gu guztion aldizkaria bizirik mantentzen asmatu duzuelako, kemenez eta gogoz, arrastoa galdu gabe. Eta nola ez, nire kartzelako kronikak gustura jaso dituzuelako. Zoritxarrez ez dut aukerarik izan kartzelako egoera bere osotasunean deskribatzeko. Dakizuenez, Soto del Realeko asteburua eta Valdemoroko hilabetea kenduta, Dueñaseko 11. moduluan eman ditut nire kondenako zortzi urteak -barruko hizkeran esanda, kanpaina osoa-. Ez dut ikusi dudana besterik kontatu nahi izan. Ulertuko duzue, hala ere, kartzeletan joan-etorri handia egoten dela, eta jendearekin batera beste patioetako iritzi-miritziak heltzen dira: beraz, esan genezake, mutatis mutandi, toki guztietan txakurrak ortozik.

Hogeita hamalau borroka-kide ezagutu ditut Dueñasen. Horietatik hamar bat lagunekin estutu ditut harremanak, elkarrekin bizi izan baikara: Jose Luis, Iñaki, Ibon, Oskar, Igor O. eta Igor CH, Mikel, Txomin, Oier eta Lander. Besteekin noizbehinka eta presaka egon naiz, lokutorio bidean, erizaindegian, hauteskunde-egunetan, etab. Gehiagorako tarterik ez da egon. Nahi baino gutxiagotan eduki dut kolektiboaren berri zuzena, abokatuen bisita, beste espetxetan dauden preso politikoekin gure gauzei buruz patxadaz mintzatzeko beta. Beste dozena bat lagunekin izan dut korrespondentzia idatzia, jakinda, noski, gure eskutitz guztiak begiluzeen begiradapetik pasatzen direla, eta ondorioz, autozentsura ezinbestekoa dela. Zer erremedio, ez baduzu prentsaren lehen orrialdeetan atera edo albistegiren bat ireki. Irudipena dut horretarako famatua izan behar duzula; edozeinen iritziak ez dira albiste. Kontuz ibiltzea onena, edozein moduz. Inoiz ez baita onerako izaten, kalterako baizik. Esan nahi dudana da nire ikuspegia, kartzelari buruz, partziala dela; protagonista eta esperientzia asko zuzenean ezagutu gabe noa.

Inoiz idatzi dut: kartzelaldi arina izan da nirea. Kide beteranoek kontatu didatenaren aldean, deus ez. Nire baitan, nire bizitzako faktura batzuk ordaintzen, sentitu dudan oinaze bortitza, askatasun-falta fisikoa baino, hagitzez, saminagoa izan da. Kitto. Amaitu da.

**Kartzela ala psikiatrikoa**

Beharbada nire izaera izango da: arreta berezia jarri dut preso arrunten egoera, bizimodua eta etorkizuna behatzen. Nire lehen (eta espero dut azken) kanpaina izan da, eta biziki hunkitu nau barruko bizitzak. Atzerritarrentzako espetxean egon naiz, beraz, mundu osoko auzoak izan ditut; jende pobrea, kolpatua, bizitzak higatua, drogaz ondatua, bizimodu txukunagoaren bila urrunetik etorri eta alferrik galdua, hizkuntza, kultura eta erlijio anitzeko jendea, trapitxeoan eta gezurrezko harremanetan zaildua, gure gizartearen bazterrean bizitzera behartua. Espetxean inori ez zaio galdetzen zergatik heldu den bertara, zer demontre gertatu zaion. Askok galdetu gabe kontatzen du, konfiantza minimoa sumatuz gero. Egia esaten ari ote diren igartzea ez da samurra izaten, miseria estaltzeko ez baitago gaizki fantasia apur bat. Gehien-gehienek harreman eskasa daukate familiarekin, ez telefonoz, ez bisita bidez. Ondorioz, eskean ibili ohi dira, ahal badute euskaldunen abaroan. Hemengo aberatsak gara, diruz eta maitasunez. Aho zabalik geratzen dira astero daukagula lagunen bat lokutorioan zain, senideren bat bisean. Zuek bai zoriontsuak, entzun diet inoiz. Batzuekin oso ondo konpondu naiz, ahal izan dudan arreta guztia jarri dut ulertzen, nire neurrien arabera eusten, bizitza alegratzen (kafea, tabakoa eta garagardoarekin hobeto!). Enpatia-falta ez da nire akatsetako bat. Askotan zaila bilakatzen da jende hau nola lagundu ebaztea. Miseriak norberekoikeria ekartzen du, sarri. Presentea dute beltza, eta etorkizuna zer esanik ez. Euskal herritar-

koadrila ere ezagutu dut, atzerritarrak bezain galduak, komeriak izango dituztenak gure gizartean egoki txertatzeko: lanik ez eta gogorik ere ez, malo! Lastima nik nobelista izateko gaitasunik ez izatea. Soberan dago hemen gaia.

Maiz galdetu diot neure buruari: hauetako batzuek zer demontre egiten dute hemen. Espetxea baino gehiago psikiatrikoa ematen du. Bere burua gobernatzeko gai ez den jendea, burutik seko nahasia, injekzio gogoren bidez irauten dutenak patioan, zonbiak iduri, sekulan inorekin hitz egin gabe, hara eta hona bueltaka, begiak lurrean josita, bere buruarekin bakarrizketan, lo zorroan, lo astun psikiatrikoan.

Halako batean euskal herritar gizajo bat bidali digu hezitzaileak: joan zaitez Zalakain eta Marurirekin, horiekin ondo ibiliko zara. Gaixo psikiatriko diagnostikatua da. Lagun iezaiozue, erregutu dit hezitzaileak. Eta aitortu dit: auskalo non bukatuko duen! Eta hau bezala patioko asko. Hauek psikiatrikoan egon beharko lukete, baina gizarteak ez du erantzun egokirik; barrura eta hor konpon. Arrazoia daukazu. Zer esan behar nion, ikusita barruko populazioaren gehiengoa botika psikiatrikoak hartzen dabilela…

**Kezkatuta noa**

Aitortza bat egin behar badut nire azken kronika honetan, hauxe: oso kezkatuta noa, preso politikoen etorkizunari dagokionez. Jaurlaritzak Hitzeman eta Zuzen Bide proiektuak bidali dizkigu. EH Bilduk Bakerako Euskal Bidea proposatu du, non preso politikoon ibilbidea marrazten den kalerantz. Programak programa -alde nabarmenak daudela onartuz eta denetan dauden alde positiboak ukatu gabe- non dago testu hori(ek) errealitate bihurtzeko mekanismorik? Inon ez. Ez naiz hasiko nire argudioak aletzen. Hain ergela ez naiz. Denbora izango dugu kalean patxadaz, dagokienekin, mintzatzeko. Irudipena dut, hala ere, luzerako, oso luzerako, doala kontua. Ni joango naiz eta barruan jarraituko dute besteek, bakoitza bere txandaren zain: **L**. (nire izateko bikotea azken lau urteotan), 19 urterekin hasi zen kondena, 3 urte barru (ia 40rekin) bukatuko ote duen amestuz; **O**. kendu dioten konfiantzako psikologoaren hutsunea nola beteko duen aztertuz; **JM**. patioko hormigoia zapaltzearekin bat Hernaniko baserria gogoan, sumatzen hasi den bertigoak gainditu ezinik; **B**., 14 urte jan ondoren bi haurrengana so, etorkizunaren haizeak nondik joko ote duen peskizan.

Beste inoiz ere idatzi dut: sarreran esan zidaten hemendik konplituta ateratzen da, motel. Hori besterik ez dut ikusi; hiltzeko zorian zaude edo hobe duzu barruko indarrak bildu eta eustea. Aitzol eta Jose Migel hor daude gaixo larri: nire ikasleak izan ziren, bat unibertsitatean eta bestea seminarioan. Irteeran, beste beterano batek esan dit: "zu aterako zara, ni eta ni bezalakoak ateratzea da arazoa". Kode Penala aldatu gabe, jai! Prozesuetan konfiantza ez galtzea ezinbestekoa da. Helburuak epe motzerako proiektatu eta sinetsaraztea berriz, etsigarria. Nire esperientziak erakutsi dit presoak tinko eta lasai jarraitzeko behar dituela aupadak… Edozein moduz, agur eta eutsi goiari, adiskideak!

# EPILOLOGA

---

Kartzelako 12 kronika hauez gain Jexuxmari Zalakinek beste hiru testu idatzi zituen kartzelan: elkarrizketa bat (Utopia aldizkarian argitaratua), propio eskatu zioten artikulu bat, bere tokian azaltzen den bezala gero argitaratu ez ziotena eta Ataramiñerako hitzaurre bat. Hurrenkera horretan azaltzen dira edizio elektroniko honetan, hirurak idatzi ziren hizkuntzan; elkarrizketa eta artikulua gaztelaniaz, hitzaurrea euskaraz.

---

# “Soy un preso político con todas las consecuencias”

---

Elkarrizketa hau preso egon den bitartean egin zaio Jexuxmari Zalakaini, Dueñaseko espetxean. *Utopia* aldizkarian (Redes Cristianas, Madrid) argitaratu zen (80. zbk. 2011, abendua), “¿Quién es el prójimo” izeneko elkarrizketa kolektiboaren parte da. Autoreak: Amparo Madrigal, Emiliano Tapia, Luis Pernía, Gregorio Ubierna, Evaristo Villar. Harekin batera beste hiru lagun elkarrizketatu ziren: Miguel Angel gazte nafarra, Ibraim Niaang eta Valentina Chicu migrariak.
http://www.revistautopia.org/

---

**¿Te has sentido apaleado? ¿Por quén y cómo?**

En líneas generales no puedo quejarme de lo que me ha dado la vida: tuve una familia estructurada, la oportunidad de estudiar y formarme, de viajar, etc. Me ordené sacerdote en la orden de los Claretianos; lo dejé, me casé, adoptamos una hija y tenemos cuatro nietos. Entre los frailes, a la luz del Vaticano II, aprendí a optar por los pobres y excluidos; descubrí que no sólo las personas, sino que también los pueblos, tienen vida y dediqué mi tiempo a preservar y favorecer esa vida, trabajando por recuperar su lengua y su identidad. Un buen día, mientras aún era sacerdote, un pelotón de policías entró con gran estruendo en mi casa, fui conducido al cuartelillo y allí, después de un amable interrogatorio, uno de ellos giraba a mi alrededor y golpeaba suavemente mis riñones diciendo: “no se preocupe, nosotros no torturamos reverendos”. Me expulsaron de la Universidad por negarme a ser funcionario y reclamar un contrato laboral para el profesorado, y estuve quince años a sus puertas, con una pancarta, hasta que ganamos el pleito. Mientras trabajaba profesionalmente en el diario EGIN, primero como periodista y luego como directivo, algunos “se atrevieron” impunemente a cerrar aquel diario, y un tribunal presidido por la inefable Angela [Murillo] me condenó a 9 años de prisión por “colaboración con banda armada”, después de dejar escrito en la sentencia que “no se le conoce ninguna relación con ETA”.

**En tu estancia como persona privada de libertad, refléjanos cómo también has visto y ves que otras personas sufren esta misma situación.**

Dejándonos de eufemismos, yo no soy un interno; yo soy un preso político vasco, con todas sus consecuencias. Mi prisión está siendo “dulce” en comparación a todo lo que me han contado mis compañeros presos. No he sufrido como muchos de ellos aislamiento, palizas, humillaciones, insultos, vejaciones, inasistencia sanitaria. Y no he tenido que preferir la cárcel al infierno de comisaría. Os aseguro que hay cosas que no se pueden fingir. Tampoco me han eliminado mis “redenciones” legales para impedirme salir a la calle al término de la condena impuesta por el juez, prolongándola 7 u 8 años como a tantos compañeros/as. ¿Alguien me puede explicar por qué a algunos presos (políticos y comunes), además de la condena judicial, se les somete a penalidades durante su periodo de prisión impidiéndole llevar una vida carcelaria normal? Es el reglamento penitenciario, naturalmente, pensado para quebrar al condenado y llevarlo a las puertas del suicidio o a la miseria moral. Naturalmente, todo

muy legal.

**¿Cómo has sentido y vivido que personas e instituciones hayan pasado de largo ante tu situación y la de otros y otras?**

Yo no soy nadie para pedir a alguien que me (nos) tenga en cuenta, me (nos) visite y atienda. Estas cosas se ofrecen gratis. Y cada uno sabrá. De todas formas, yo estoy emocionado y agradecido por las muestras de cariño y solidaridad que me dan a diario gentes de mi pueblo, Euskal Herria, generalmente consideradas indeseables. Pero junto a mi viven cientos de personas —casi todas extranjeras, pero también originarias— sin ningún apoyo: ni visitas, ni dinero, ni llamadas telefónicas. Nada. Sin futuro. No soy tan ciego para no ver el esfuerzo de personas y algunos colectivos, religiosos y civiles, por hacer más llevadera la vida de los "comunes", pero más de uno se lo debería hacer mirar... En su día hice voto de pobreza, y nunca me faltó nada importante. Ahora vivo entre los condenados de la tierra, víctimas de la exclusión y de sus propios errores. Lo llevo muy mal. La cárcel no ha conseguido que deje de enternecerme y rebelarme ante semejante situación.

**¿Cómo has visto y sentido en ti mismo la posibilidad de curar situaciones como la tuya? ¿Qué gesto y actuaciones se necesitan de una sociedad como la que vivimos hoy?**

Afortunadamente yo me siento mimado por mi gente, y mis heridas personales van curando... aunque leo y oigo que algunos de nosotros no deberíamos salir nunca de aquí. Quienes consideran poca condena una pena de prisión de 20, 30 o 40 años y aún reclaman la cadena perpetua no saben lo que dicen. Sólo les falta pedir que que nos fusilen —aunque quizá preferirían vernos arrastrados pidiendo clemencia— sin comprender que una pérdida irreparable no se compensa con un castigo también irreparable. Así nunca curarán sus heridas, emponzoñadas por la venganza. En términos políticos, mal va la cosa si no se es capaz de comprender que hubo y hay un conflicto político de fondo —la existencia de un pueblo al que no se reonoce su derecho a decidir sobre su futuro—, que ha habido y hay varias partes, históricamente enfrentadas de distinta manera, con distinta suerte y distintos damnificados. En cuanto a las actuaciones, no estaría mal comenzar por eliminar las leyes de excepción, o "legislación del enemigo", construidas sobre la fuerza y la venganza, y volver a la normativa general, revisar condenas, impulsar una legislación transaccional, etc. Luego intentaremos ser libres y decidir nuestro futuro. Eso lo cura casi todo. En todo caso, una "Comisión de la Verdad" sería interesante.

**Dónde crees tú que puede estar el camino para emprender la tarea de curación de tantas personas y colectivos que pueden sentirse apaleados y excluídos?**

A las personas apaleadas y excluidas, específicamente presos comunes, creo que hay que comenzar por tratarlas como personas, no como ganado. Me parece que la mayor parte de ellas tiene la impresión de que las mismas personas e instituciones que les piden sensatez, buena conducta, respeto, son las que se pasan las leyes y los derechos humanos por el arco del triunfo. Más allá de sus miserias —que son las de todos nosotros y nosotras pero en circunstancias adversas— ellos ven que quienes despojan al pueblo de sus bienes apropiándose de los mismos se van de rositas, o en su caso, no son castigados con la misma dureza. A estas alturas, ya han perdido la confianza de poder tener oportunidades. La mayor parte de

ellos volverán más pronto que tarde. Al menos comerán y dormirán bajo techo.

# Cambiarse cambiando

---

Artikulu hau Dueñaseko espetxean preso zirauela idatzi zuen Jexuxmari Zalakainek, aita Mario bertako kapilauetako batek propio eskatuta, hark Valladoliden zuzentzen duen aldizkari baterako. Azkenik artikuluak ez zuen argia ezagutu, izan ere fraileari espetxeko agintariek esan zioten ez zitzaiola komeni euskal preso politikoarekin harremanik edukitzea. Irakurri ere ez zuen egin artikulua presoak eskura aurkeztu zionean; desenkusak eman zizkion, hala ere.

---

La verdad es que atreverse a hablar de "cautividades" en una publicación de los Padres Mercedarios, fundados precisamente para "liberar a los cautivos", es poco menos que una temeridad; pero, en fin, dado que he sido invitado a ello por el propio director, capellán de esta prisión de Dueñas en la que me encuentro, voy a tratar de escribir algunas reflexiones. Es un honor que agradezco.

Uno de nuestros mejores escritores en euskara, Joseba Sarrionandia, cuando aún estaba preso (antes de protagonizar su espectacular fuga dentro de unos bafles, tras un concierto en la cárcel de Martutene), se dirigía de esta manera a sus lectores: "desde la cárcel pequeña a los habitantes de la cárcel grande". El escritor vasco quería expresar que también aquellos que no han sido condenados a pena de prisión viven, de alguna manera, en una cárcel, incluso mayor.

No se si es el escritor vasco se refería expresamente a las cautividades interiores que, en distinta medida, padecemos los seres humanos. Ciertamente se refería a que tampoco las personas pretendidamente libres gozan de entera libertad —no se lo vayan a creer—, máxime en esta sociedad económicamente salvaje, ferozmente individualista y políticamente castradora de los derechos individuales y colectivos.

El que sí ha hablado de cautividades interiores ha sido Mons. Munilla, obispo de Donostia, en su homilía del 24-IX-2012, en la prisión de Martutene, en la festividad de La Merced: "l*a llave de esta cerradura que cierra el paso a nuestra libertad no es otra que nuestra propia conversión*"; señalando, además, que "*Dios es el único que puede cambiar el horizonte de la vida*". ¡Qué manía esta de presentar nuestra religión, ideología o valores como los únicos capaces de enderezar el rumbo de todos los humanos! Parece como si para algunas personas fuera imposible ofertar sus propios descubrimientos como una posibilidad, un camino, una opción, una invitación o una apuesta personal presentada con humildad, no necesariamente útil para todos. Lo que sucede es que —nunca, pero hoy en día menos— los mensajes sólo calan si son creíbles, y sólo lo son si llegan al corazón de la gente como un ejemplo a seguir, no como una imposición. Apelar a lo trascendente religioso, como hace el obispo, desentendiéndose de las mediciones materiales —es decir, en este caso, de las necesidades de todo tipo de los prisioneros, políticos y comunes— no es cristiano, ni creíble.

Para empezar, lo trascendente no pertenece sólo al ámbito de lo religioso, y por ende, la conversión no es únicamente religiosa. Pertenece al ámbito de lo humano, en su hondura más profunda. No se puede

pretender que alguien se sumerja hasta el fondo de su ser si apenas sabe nadar en la superficie. Que me perdone monseñor, pero los presos/as necesitamos que no nos hagan trampa: necesitamos sentirnos respetados como personas, no abusados ni chuleados, necesitamos sentirnos queridos, invitados a progresar y a desarrollarnos, acompañados etc, etc, antes de pensar en más allá. Todo tan humano...!

Es cierto, por otra parte, que en mayor o menor medida, todos somos un poco cautivos, arrastramos nuestras propias cadenas, estamos ligados a distintas adiciones poco humanizadoras. La peor de todas el miedo a ser “el dueño de mi destino, el capitán de mi vida”, como dijera Mandela, enganchados como estamos a la obediencia injustificada, a las leyes y reglamentos autoritarios, a la esperanza de que alguien o algo nos salvará definitivamente, a la renuncia interior a cambiar lo que nos rodea, etc. Lejos de mí señalar el camino a nadie. Cada uno podrìa hacer su propia lista de cautividades, pero con qué maestría nos han hecho creer que hagas lo que hagas todo seguirá igual. Pues no!

Lo que nunca entendí es que el cambio —o la conversión, si preferimos una palabra más rotunda— se reduzca a una empresa solo individual; ni que la conversión personal preceda necesariamente a la colectiva, como si viviéramos en tiempos de los anacoretas. Yo reivindico que el cambio —al menos en la cultura occidental de la que formamos parte— sólo se efectúa de manera dialéctica si queremos que sea un proceso sano, que uno puede cambiar profundamente si se expone a una interacción solidaria con otros humanos, tratando de resolver sus problemas y siendo a la vez ejemplar y coherente con lo que se propone, dejando que en nuestro corazón resuenen el dolor y la alegría —en definitiva, la vida—, sometiéndonos en la medida de nuestras fuerzas a un proceso de transformación que nos hará a todos más humanos.

# Ataramiñe'14. Hitzaurrea

Ataramiñe'14. 2014, abendua
http://www.literaturakoadernoak.org/?p=3486

**Hitzaurrea**

Nola esaten zaio ezetz lagun bati laguntza eskatzen dizunean? Nola ukatu zure kolaborazioa bi hamarkada kartzelan egondako kideari? Areago, mesedez, arren, otoi eskatzen dizunean. Egia esan, inolaz ere ez. Soilik arrazoi horrek azaltzen du nire presentzia ATARAMIÑEko orriotan. Eta ohore bat da, oroz gain.

Orriotan, hain zuzen. "Orriok" hitzaurrekoak baitira. Beti iruditu zait presoari bere gogoetak, irudimenezko lerroak, fikziorako gaitasuna, pentsakizunak edota barne-isuriak adierazteko plataforma bat eskaintzea. Jon Etxeandia zenak zuzenean azaldu zidanetik oso argi daukat. Asko ez dut jarraitu. Ez dut orain arte sekula parte hartu, dela pudoreagatik, dela badaukadalako beste plataforma iraunkor bat nire kontuak askatasunez plazaratzeko. Herria 2000 Elizan argitaratu ditut aldika nire gogoetak "kartzelako kronikak" delako espazioan. Abusatzea iruditu zait beste espazio bat ere betetzea.

"Hitzaurrea zuk egitea pentsatu dugu" jakinarazi dit adiskideak. Pentsatzen jarrita, hitzaurre bat zer demontre den aztertu dut. Era askotakoak daude: aldizkari barruan dagoen mamia laburbiltzen dutenak, ideia nagusiren bat jorratzen dutenak, edukia perspektiba orokorrean kokatzen dutenak. Zoritxarrez nik ezin dut holako ezer egin: ez dut ezagutzen zer idatziko den, autoreak zeintzuk diren, gai nagusirik dagoen, fikzioa gailentzen den, poesia, errelato alegorikoak edo beste zerbait. Beraz "nire esku" dagoena egingo dut, nire esperientzia eta eskarmentua eskainiz, gai librean saiatu. Gutxi-asko konpartitua izango den ez jakinik, nire-nirea da, nire baitako errotarriak zazpi urteotan ehotu duena eta nire antena pertsonalek hauteman dutena. Ez naiz inoren izenean ari, beraz. Nire gauzak dira: nire miña eta nire mihia.

18/98 sumarioa burututa hona ekarri nindutenean, Konfuzioren bidetik barne-bidaian murgiltzera nindoala jakinarazi nuen, beste kide presoen bizitza konpartitzen nuen bitartean. Halaxe egin dut. Bidaiaren abiapuntua "barrura begiratzeko leihoak" filmeko testu grabatuan dago. 15 hilabete geratzen zaizkidanean berriro Euskal Herrian lur hartzeko, aukera aproposa izan daiteke hau behin-behineko balantzea egiteko. Ondoko hau:

**Kartzelaldia ez da denbora galdua**

Esaldi heterodoxoa ematen du. Eta bada, kartzelaldia parentesi gisa hartuz gero. Egitasmo asko desegiten ditu kartzelaldiak, baina ez da parentesia. Bizitzaren joanean batzuoi egokitu zaigun atala baizik, bizitzaren zati bat edonola ere, aurrekoak azaltzen duena eta ondorengoa baldintzatuko duena. Inork ez du kartzelara sartzea eskatu, Koldo Izagirreren Agirre zaharrak izan ezik. Ez da igurikatutako egoera bat, baina zozketa itsuko emaitza ere ez. Maila batean edo bestean Euskal Herriko askapen-prozesuan parte hartu dugunontzat gerta zitekeen aukera zen hemen amaitzea. Horren jakitun bizi izan gara, arriskuak

arrisku. Besterik da prozesu justu baten ondorioz gauden hemen…

Sartu orduko konturatu nintzen denbora dela kartzelak debalde eskaintzen duen bakarra, mendean hartu ezin duena. Presoarentzat bere salbabidea ere bada, txaboloaren estutasunak, harresien astunak eta barroteen burdinazko lerroek zein norberaren grina txarrek burua jatea nahi ezean. Norberak taxutu behar du denbora ahalen eta zaletasunen arabera: esku-lanetan, ikasketetan, idazketan, kirolean, etab. Kartzela lasaia egokitu zait niri. Ez galdetu zergatik. Beteranoei entzunda, ez daukat kexatzerik: ez naute zigor-ziegetan isolatuta eduki, ez naute jazarri eta jipoitu, ez dut tira-bira gordinik ezagutu, ez naiz bereziki xaxatua sentitu. Errepideko loterian ez dut seniderik galdu. Txikikeriak nozitu ditut nik.

Nire zaletasunei atxiki natzaiei, bizirauteko: irakurri-idatzi- binomioari, eta azken boladan aurkitutako zeregin kuttunenari, itzulpengintzari hain juxtu. Ez da meritu handia. Besterik egiten ez dakit! Hala, 3 urtez katalana ikasten jardun ondoren 4 liburu itzuli ditut: Rodoreda-ren “Diamantearen plaza”, Pedrolo-ren “Makinaizkribua”, El Hachmi-ren “Azken patriarka” eta Pla-ren “Kale estua”. Ordenagailua erabiltzea debekatuta daukadanez Joserra Etxebarria eta Joseba Azpeitia adiskideei ezker lortu dut nire eskuizkribuak pikatu eta orraztea. Ingelesez hizkuntzan “intermediate, B1+” mailara iritsi naiz zerotik hasita. Gaztelaniaz idazten eta irakurtzen irakatsi diot Extremadurako analfabeto bati… eta sekula baino kirol gehiago egin dut, nire adinean (66) egokiena dena eginez: patioari itzuliak kendu. Hori orain arte. “Hemendik sano atera behar da” errepikatu dut eskutitzetan. Ez dakit bada! Urtebetez geroztik inflamatuta daukat eskuineko aldaka eta txikituta meniskoa. Ordu erdi jarraian ibiltzeko gauza ez naiz; beraz, ederra panorama!

Aurreko guztia egiten nuen bitartean nire nortasunaren eta ibilbidearen zoko-mokoak miatzen ibili naiz, errukirik gabe: deskubritu dudan guztia ez zait gustatu. Gauza batzuk batere ez. Norbaiti interesatzen ba zaio eskuz atonduta daukat nire bizitza osoa hartzen duen “biografia kritikoa”. UPVko pankartaldi luzean (16 urte) nire/gure ahalmenen jabe izan nintzen; kartzelaldiak nire mugak erakutsi dizkit. Zein ona naizen arazo kolektiboetarako eta zein kaxkarra nire-neureak diren gauzak kudeatzeko. Zer gogorra den zure buruari aitortzea: “honekin ezin diat”. Nork esan zuen inoiz ez dela berandu? Bizitzak gordeta zeuzkan faktura batzuk ordaindu behar izan ditut. Nik eskatu gabe argitu den dirdiraz azaldu zaizkit bizitzako pasarte, erabaki, hanka-sartze, hutsegite eta urratsak. Aurrerantzean nola kudeatuko dudan ez dakit. Gauzak pazientziaz hartzen ikasi dut. Bakardadean izaten ere bai. Baina nire buruaz irri egiten ez. Nolanahi ere den helduago, xumeago, apalago eta orekatuago aterako naiz zulo honetatik.

Zenbat adiskide ditudan dastatzeko atsegina eman dit kartzelaldiak. Lastima lokutorioko kristal madarikatuak lapurtu dizkidan besarkada, muxu eta laztanak. Begi batzuetan malkoak antzeman ditut, beste batzuetan irri-goxoa, izarniadura berezia; bostekoa zabalik leiarrean nirearen bila. Kalaka, berriketa, konpromisoa, haserretxoaren bat edo beste. Zenbat jende solidario! Harreman oso maiztua geneukan familiako kide batzuekiko lotura sendotu da. Noiz erakutsiko diegu zor zaien ohorea presoaren senar, emazte, bikotekide eta maiteñoei? Soilik galdu duzunean sentitzen duzu ausikia. Nola izango da denbora galdua kartzelaldia!

**Gauzak ez dira beti amestu bezala amaitzen**

Kartzela gogoeta politikorako unea ere bada. Sartu eta gutxira ezker abertzalearen ziaboga edo egokitzapen orokorra suertatu zen. Zerbait banekielakoan, ezustean harrapatu ninduen. Durduzaturik bizi izan dut. Batik bat gauzak zein azkar aldatzen ari ziren (edo zein egosirik zeuden) ezin ulerturik; eta halabeharrez, modu pasiboan. Etxe honetan izandako eztabaida hutsaren hurrengoa izan zen, auskalo zergatik. Gerora, aparteko arazorik gabe sartu gara korronte nagusian. Gogoan daukat nola esan nion une hartan lokutoriora etorritako adiskide min bati: “akabo epika eta lirika”. Eta esan nahi nuen, alegia, hemendik aurrera gure politika egiteko modua hitz lauz egingo dela. Ulertarazi nahi nion hartutako bidea prosazkoa izango dela. Ez nuke okertu nahi baina gure bide honek ez ditu poeten bertsoak zorroztuko, bardoen mihiak askatuko, poema kolektiboak sortuko. Musikariek ez dituzte euren sokak tenkatuko, ez eta ipuinlariek pertsonaia eredugarririk topatuko, gazteen bihotzak ez dira hor sutuko. Prosa xumeak, gauzak azaltzeko; ez literatura magikoa. Intuizio bat izan zen, baina horri atxikita jarraitzen dut. Zergatik? Bada gauzak ez direlako gehienetan guk amestu bezala gertatzen. Bizpahiru aldiz ezagutu dut hau bizitzan: zuk borroka egiten duzu helburu baten xerkan, eta amesten duzu nola izango den amaiera, Xabier Letek abestutako “askatasun-eguna”, eta gero, bide erdian, xedera hobeto iristeko, egiten duzun birajean, konturatzen zara ustez printzipio ziren gauzak tresna huts zirela; eta kasurik onenean amaiera erdietsirik, ohartzen zara eskuartean daukazuna uste baino arruntagoa dela, lore-jokorik gabea, ereinotz-koroarik gabe: hitz lauzkoa. Hala ere, etzazu borroka egin, eta hutsean geratuko da ahalegin guztia.

**Badago bestelako euskal herritar sakabanaturik**

Orain arteko kartzelaldian 32 kide ezagutu ditut Dueñasen. Dozena batekin konpartitu ditut bizipenak. Orain lau gaude, binaka banatuta. Pena bat badut, gure kolektiboa hain zabala izanik, beste askorekin ezin konpartituagatik. Sakabanaketa da arau, eta aberastasun hori ezagutu gabe aterako naiz, itxura guztien arabera. Arrazoi izango du Juan Mari Olanok dionean: “kartzelakoa da estatuei geratzen zaien giltza bakarrenetarikoa”. Sakabanatuta gaude, eta beste euskal herritar-mordoa ere bai. Inozo ni, ez nekien hori gertatzen zenik! Badago aldea: gu sistematikoki sakabanatzen gaituzte; besteak, ·portaeraren arabera. Euskal gazte asko ezagutzeko parada izan dut; ez oso sakon, egia esan. Batzuk euskaldunak, beste batzuk asilbestratuak, eta beste asko euskaldun hutsak. Nire auzo Santutxukoak ere bai, batzuk. Badira beste hainbat, jatorriz Magrebtarrak,Latinoamerika edo Errumaniakoak, Euskal Herrian kokatu direnak edo bertara joateko asmoa dutenak: “diru gehiago dagoelako”. Ospe ona daukagu euskaldunok patioetan -preso belaunaldien zuzentasunaren seinale-. “Gehiago errespetatzen zaituzte” diote. Poztekoa, daukaten perspektiba. Gehienak lapurretan ibiliak dira, bertokoen antzera drogaren eraginez sarri. Aldatzeko asmorik ez zaie ikusten. Askotan pentsatzen jarri naiz: da al daukagu horiei buruzko politika zehatzik? Nola guretuko ditugu kanpotarrak euren izaera errespetatuz?; aldi berean nola askatuko ditugu -eurak zein bertokoak- xede txukunik gabeko bizimodutik? Musulmanen kasuan ez ditugu ezagutuko euren erlijioa aztertu gabe. Adi! Kide dezente ikusi dut gizarte-gaietan trebatzen, animatzaile sozio-kultural, integratzaile, etab. izateko. Soldatarik ez dakit, non saiatu behintzat izango dute.

**Legea, zein lege?**

2013ko abenduan idatzi zuen EPPK-k azken aldiko agiri funtsezkoena. Ez dut esan beharrik ados nagoela. Baina amorruz hartzen dut hau, legeari buruz esaten diren pasarteei buruz bolo-bolo dabilen interpretazioa: “legea betetzea erabaki dute”. Nahasgarria baita. Legea betetzeko prest omen gaude, eta ez

omen gara betetzen ari. Sofisma bat dago hor. Legea aipatu dugu agiri horretan, edozeinek dakielako ze garrantzia daukan legeak gizartean. “Ados gaude aurrera begira legeek eta beren aplikazioek berebiziko papera dutela, eman behar diren urratsak sendotzeko izan behar baitute”. Baina gu lege berriari buruz ari gara, justiziara hurbiltzen den legeaz. Oraingoaz ez, alegia.

“Premiazkoa” da salbuespen-neurri eta egoerak bertan behera uztea. Tresneria judizial-juridikoa egoera politikora egokitzea, kartzela-politika errotik aldatzea eta sakabanaketari lehentasunez amaiera ematea. Soilik testuinguru horretan, lege-aldaketa egiten bada: “Horiek horrela, ontzat eman dezakegu gure etxeratze-prozesua (…) lege-baliabideak gauzatzea”. Hala ere, sakabanaketari amaiera emateko prozedura legalari jarraituz eskariak egitea erabaki dugu, besteak beste horretarako legea aldatu beharrik ez dagoelako. Baina bi gauza desberdin dira, nahastu beharko ez liratekeenak, egiari zor. Nik biziki eskertuko nuke, gutxienez gure jendea, zehaztasun handiagoz mintzatzea.

*Dueñas, 2014ko abuztuan*



**Jexuxmari Zalakain Garaikoetxea** (Tolosa, 1947) euskal herritar irakaslea, kazetaritzan doktorea, euskaltzalea, idazlea eta kazetaria da. Zinematografian diplomatua ere bada. Euskarazko prentsako bultzatzaile gisa eta kazetaritzako gaiak euskaraz ezagutarazteko testuak egiteko lanean nabarmendu da. Horren adibidea da 1992an defendatu zuen bere doktorego tesia, “Euskal prentsa herri proiektua da” izenekoa. Euskal komunitate zientifikoaren Inguma datu-basean, berak idatzitako 30 lan baino gehiago dira.

Egin egunkarian (1982-1986), Anaitasuna, Jakin, Argia, Misión Abierta (1978-1987), Herria 2000 Eliza eta Uztaro aldizkarietan parte hartu zuen. Udako Euskal Unibertsitateko Kazetaritzako sailburua izan zen hainbat urtetan, Euskaldunon Egunkaria egunkaria sortu zuen Egunkaria Sortzen ekimeneko sustatzailea ere bai.

Beste irakasle batzuekin batera, 1992-2007 bitartean EHUtik kaleratua izan zen, haren kontratazio-sistema onartu ez eta derrigorrez funtzionario izan beharrean kontratu laborala eskatzeagatik. Hamabost urteko borroka egin ondoren lortu zuten gaur egun indarrean dagoen kontratu-mota hori. Bizitako esperientzia “Historia de una pancarta” (Pankarta baten istorioa, Arabera argitaletxea, Gasteiz 1999) liburuan jaso zuten.

Zalakain Egin egunkariko administrazio-kontseiluko kide izateagatik preso egon zen. 18/98 auzian epaitu eta zortzi urteko zigorra jarri zioten. Espetxean egon zen bitartean, Herria 2000 Eliza aldizkarian idatzi zituen "Espetxeko Kronikak". 2015eko irailaren 27an utzi zuten aske.

Jexux Mari Zalakain aske geratu zen espetxe-zigorra osorik bete ondoren. Kartzela-atarian itxaroten izan zituen berarekin batera zigortu zituzten Pablo Gorostiaga, Murga anaiak eta Jose Luis Elkoro.

«*Auzitegi Nazionalak emandako epaiarekin agerian geratu da, beste behin, 18/98 auzian ideiak epaitu eta zigortu dituztela, ETArekin batere zerikusirik ez duten erakunde abertzale, politiko eta sozialetako*

*kideak epaitu eta zigortu dituztela. Agiri hau argitara ematearekin, geure ekarpena egin nahi dugu gogoeta egiteko, egungo egoeran, inoiz baino beharrezkoa den gogoeta egiteko.*» Mariano Ferrer kazetariak Bilbon, 2007ko abenduaren 20an, 18/98+ Plataformaren izenean.

Enara Goikoetxea zinema-zuzendariak Jexuxmari Zalakainen esperientzia kontatu du "*Barrura begiratzeko leihoak*" film dokumentaleko atal batean.

**Liburuak**

Informazioaren teoria eta teknika irrati eta telebista digital eta analogikoan. Iñaki Zabaleta Urkiola eta Jexuxmari Zalakain Garaikoetxea. (UEU, 2004). ISBN: 84-8438-050-5

Joxemiren uzta (Txalaparta. 1993) ISBN: 9788481369045

Balentxi. Hamalaugarren apostolua. (Txalaparta. 2007) ISBN: 9788481364972

La tortura en Euskadi. Kepa Landa, Carlos Martin Beristain, Rosa Olivaares eta Jexuxmari Zalakain (Editorial Revolución-Herria 2000 Eliza, 1986) ISBN: 84-85.781-48-I

Hizkuntza eta lurra = Lengua y territorio. (Herria 2000 Eliza, 2003)

Mundua ulertzeko txostenak. Alfons Banda eta Jexuxmari Zalakain.(Intermón Oxfam, 2002)

Xalop, Bori-Bori eta Sakelandi bidelapurra. Enric Lluch, Jexuxmari Zalakain, Ana Rosa Crespo eta Enric Soler. (Edebé, 2000)

Patata frijituak. Olga Xirinacs, Carme Solé Vendrell, eta Jexuxmari Zalakain, (Edebé, 1996)

Joxemiren uzta (Txalaparta. 1993) ISBN: 9788481369045

Euskal prentsa herri proiektua da. Doktorego tesia. Zuzendaria: Nkolas Xamardo Gonzalez. (UPV-EHU, 1992). ISBN: 978-84-8428-261-4

Erlijio hiztegia/1 (UZEI, 1987). ISBN: 84-7529-479-0

Erlijio hiztegia/2 (UZEI, 1987). ISBN: 84-7529-480-4

[Biografiaren iturria: https://eu.wikipedia.org/wiki/Jexuxmari_Zalakain]

# **Atara**miñe

## → [literaturakoadernoak.org](literaturakoadernoak.org)

- **El silencio del infierno.** Fernando Alonso. 2003
- **Gosea lagun, laguna.** Segapoto kolektiboa. 2004
- **Kartzelako leihotik.** Joseba Arregi Erostarbe. 2004
- **Seineri aurrez aurre kontaturiko ipuina.** Joxe Blanco. 2004
- **Lunaren Goiztiri.** Juan Luis Mugertza. 2005
- **Azeri gosetia.** Kepa Etxebarria. 2005
- **Ataramiñe kantuz.** CD. Hainbaten artean. 2006
- **Claude Gueux.** Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola). 2007
- **Zimaren abenturak.** Belen Gonzalez / Kepa Etxebarria. 2007
- **Kartzelako neurriak.** Urtzi Zubizarreta. 2008
- **Mendian gora, mendian behera, Euskal Herrian zehar.** Mahai-jokoa. Zorion Zamakola. 2008
- **Penumbras de un ayer.** Iñaki Ojeda. 2009
- **Preso nago.** Mikel Orbegozo. 2010
- **Bakarmortuko kronikak.** Mikel Antza . 2011
- **Espetxetik at.** Borxa Urberuaga. 2011
- **Ametsen txokoan bizi baiz.** Ibon Muñoa. 2011
- **Ametsen txokoan.** CD. Hainbaten artean. 2012
- **Kandela bat pizteko behar dena.** Mikel Antza / Iker Moreno. 2012
- **Fakin xokona**. Oier Goitia. 2012
- **Sasian barna.** Xabier Makazaga. 2012
- **Preso nago 2.** Mikel Orbegozo. 2013

- **$Z^2$.** Mikel Antza. 2013
- **Agurra eta ohorea.** Jokin Urain. 2013
- **Ainarak herrira itzuliko dira.** Ibon Muñoa. 2014
- **Urte ilunak.** Nelson Mandela (itzulpena: Ekaitz Sirvent). 2014
- **Iargiraino!** Mikel Orbegozo. 2015
- **Burdin elorri arantzetan.** Joseba Arregi Erostarbe. 2015




EUSKAL ERREPRESALIATU POLITIKOEN
LITERATURA KOADERNOAK

literaturakoadernoak.org